# ATHEKA-GAITZEKO

## OIHARTZUNAK

J.-B. DASCONAGUERRE

Contseilu Yeneraleko membra batez

*Bihotz handico guiçonec ezlute*
*bertce egimbideric beharren*
*socorritcea baiçic.*

AXULAR.

---

BAYONAN

LAMAIGNERE ALBERT-ARREN, IMPRIMERIAN

Chegarayco carrican, 39 numeroan

—

1870

# ATHEKA-GAITZEKO

## OIHARTZUNAK

J.-B. DASCONAGUERRE

Contseilu Yeneraleko membra batez

*Bihotz handico guiçonec eztute*
*bertce egimbideric beharren*
*socorritcea baiçic.*
AXULAR.

BAYONAN

LAMAIGNÈRE ALHARGUNAREN IMPRIMERIAN

Chegarayco carrican, 39 numeroan

—

1870

## ESKALDUNERI

—

Irur urthe badu yadanik imprimatu ginuela liburutto hau, frantseserat itzuliz. Norbeitek galdegiten balu zertako haiñ sarri iguriki dugun hau imprima-arazi gabe, ihardetsiko ginioke iduri zitzaukula itzultze frantsesa errechki eta lasterrago saldu ginukela. Denek badakite saltze horren progotchu guziak karitatezko obra batentzat emaitekoak zirela. Bertzalde, oraiño ezagutu eskara liburuak frantsesetik edo españoletik itzuli ohi zutelakotz, nahi ginuen gure herritarreri eskaiñi lan chume bat eskaraz egiña. Hori baiñan argitarat eman aintziñean, behar zen haiñitz aldiz irakurtu, aphaindu eta emendatu. Bada egun hola garbitua baita, gure mintzaira maite duten guzieri ematen diotegu.

Etzauku iduritzen hargatik liburutto hau faltarik bat ere gabe dugula; yakintsuek kausituko dute huntan dudarik gabe zembeit huts handi, eta behar bada estakuru ematen daukute hautatu dugula maiz eskribatzeko molde bat, beren arabera zuzen ez dena. Othoiztuko ditugu barkha ditzagutela huts hoyek, egiazki lehembiziko eskara liburua dela orhoiturik. Plazerekin adituko ditugu yende yakiñek erranen dauzkiguten estakuruak, baldiñ irakurtzailliek ahantzi izanen ez badute eskribatu ginuela Donibaneko eskaran, gurea delakotz, nahiz ez den hoberena. Guti badire liburuak, polliki, garbiki eta arthezki eskaraz eskribatuak : hau beraz har dezatela, baldiñ ere iduritzen bazayote makurra, eskaraz ederki mintzo direnek, eta gure mintzaira zaharra ikhasi nahi duten arrotz bakhar eta baliosek.

# AVANT-PROPOS

La traduction française de cet ouvrage a été imprimée il y a trois ans. Si l'on s'étonne que nous ayons aussi longtemps attendu avant de faire imprimer le texte basque, nous répondrons que l'édition française nous offrait plus de chances d'un succès rapide; on sait que les produits de la vente de ce livre étaient affectés à une œuvre de charité. D'ailleurs, les livres basques connus jusqu'à ce jour étaient habituellement traduits du français ou de l'espagnol; et nous désirions offrir à nos compatriotes un petit travail réellement basque. Il était donc nécessaire, avant de le mettre au jour, de le relire à diverses reprises, de l'arranger, de le corriger, etc. C'est le résultat de cette longue révision que nous offrons

aujourd'hui aux amateurs de la langue basque.

Nous ne prétendons pas cependant que notre œuvre soit parfaite ; les personnes compétentes y trouveront probablement de grandes fautes, et peut-être nous reprocheront-elles d'avoir employé maintes fois une orthographe défectueuse à leur avis. Nous les prions de nous pardonner, en se rappelant que c'est le premier livre véritablement basque. Nous accueillerons avec plaisir les observations que voudront bien nous adresser les gens de goût, si nos lecteurs n'oublient pas que nous avons écrit dans le dialecte de St-Jean-de-Luz qui n'est pas le plus régulier, mais qui est le nôtre. Il existe peu de livres correctement et soigneusement écrits en basque; le nôtre pourra donc plaire, nous l'espérons, même s'ils lui trouvent de graves défauts, à ceux qui parlent le plus correctement le basque et aux rares étrangers de mérite qui veulent apprendre notre vieil idiome.

# ATHEKAIZECO MENDITARRA

---

AIREA : *Ene izar maitea.*

I

Arrolanen itzala ilhun nabarrian
Tristerik agertzen den arrokaren aldian,
Etche batian dago gizon bat zaharra,
Herrian deitzen dute Ganich menditarra !

II

Bere gazte demboran urus bizitzeko
Ganichek bazituen adiskide franko;
Nehor etzen mendian hau bezen askarra...
Orai hor uzten dute Ganich menditarra !

III

Aldi bat kolpatua, bere etsaiari
Bizitzeko grazia eman dio leiyalki;
Yinkoac ikusi du haren obra ederra...
Bertzek ahantzi dute Ganich menditarra !

IV

Ihurzuri borrumban, chimisten erdian,
Ibaiya pasatzen du Athekaitz aldian,
Erregiña bizkarrian, Español lurrera
Uruski heldu zare, Ganich menditarra !

V

Zerbitzu handi hori erregek diruaz
Nahi du zaristatu, eta bere eskuaz,
Eztu errezebitu Ganichek zilharra...
Urhez bihotza duzu, Ganich menditarra !

VI

Munduak ahantzia egun sofritzen du,
Bai eta miseriak haren bortan yo du
Orai zahartu eta sendituz beharra,
Bakarrik bizi zare, gaicho menditarra !

VII

Bainan haren zorteaz onkitua minki
Ganichen zorigaitzak erteko goraki
Gizon batek izan du talendu ederra...
Nigarrak agortzazu, gaicho menditarra !

VIII

Botz karitatos hori guciek aiturik,
Athera izan dute bere ilhumbetik;
Orai botzik hau dago gizon bat zaharra:
Herrian deitzen dute Ganich menditarra!

ESKUALDUN BAT.

# COMPLAINTE BASQUE

Sur l'air de *Ene izar maitea*

**Dédiée à M. DASCONAGUERRE**

Conseiller Général

**Auteur des ÉCHOS DU PAS DE ROLAND**

---

I

Non loin du roc solitaire
Où l'ombre du paladin
Revient, menaçante et fière,
Quand le jour touche au déclin,
Sous un humble toit de chaume
Demeure un pauvre vieillard;
Dans le pays on le nomme
Ganich le vieux montagnard.

II

Géant au cœur intrépide,
Son regard est assuré;
Son bras est aussi solide
Que son *makila* ferré.
Aux beaux jours de sa jeunesse,
Il fut grand, l'humble vieillard;
Aujourd'hui chacun délaisse
Ganich le vieux montagnard.

III

Dans une lutte sanglante,
Il protégea de sa main
Celui dont l'arme puissante
Venait de percer son sein.
Contrebandier magnanime,
Il fut grand, le montagnard;
Qui songe à ce trait sublime
De Ganich, l'humble vieillard?

IV

L'éclair luit, la foudre gronde,
L'ouragan est déchaîné;
Sans crainte il traverse l'onde,
Le Basque déterminé.
Voyez! sur sa large épaule,
Fardeau cher au montagnard,
La pauvre Reine espagnole:
Qui se souvient du vieillard?

V

Il dépose la princesse
Sur le sol libérateur;
Elle est pauvre, sa vieillesse;
Oui, mais l'or est dans son cœur.
Et pour toute récompense,
Il ne veut, le montagnard,
Qu'un mot de reconnaissance.
O Ganich, noble vieillard!

VI

Aujourd'hui l'oubli rapide
L'a couvert de son linceul,
Et le héros intrépide
Est demeuré triste et seul.
Hélas ! la pâle misère,
Sous le toit du montagnard,
A montré sa tête austère :
O Ganich, pauvre vieillard !

VII

Mais une âme charitable,
Chez qui fleurit la pitié,
Tendant sa main secourable
Au vieux Cantabre oublié,
A, d'une voix éloquente,
Retracé du montagnard
L'infortune déchirante :
Sèche tes pleurs, bon vieillard !

VIII

A ce cri d'un cœur sensible
Tous les cœurs ont répondu,
Et du ciel, ange visible,
Le bonheur est descendu
Sous cet humble toit de chaume
Où demeure le vieillard
Que dans le pays on nomme
Ganich le vieux montagnard.

Un Basque.

## Luis Luzien BONAPARTE Printziari.

Yauna,

Gure buruzagi handienak, osoki hartuak gure itsas hegien edertasunez, heldu dire urthe guziez hekien ikusterat eta bere emaitza nasaiez Eskaldunen gainditzerat.

Gure mintzairaren aberatstasunak zaitu zu ere gureganatu, eta zure Eskaldunen arteko egoitzak irabazarazi zaitu

bethikotz populu horren ezagutza biziena; zorionez gainditua da ikustiaz haren mintzaira ikasmenetan hartua printze batez, zeiñaren yakitate handiak berregintza gehiagoko bat ematen baitio.

Dohatsu naiz zure arartekotasunaren azpian ematiaz lan chume bat eskaraz eskribatua; huntan billatu dut agertzia gizon haiñitz aiphatu baten itchura eta herriaren ohikuntzak; huntarik bilduko den irabazia izanen da eskaldun gizon zahar gaicho bat bere zorigaitzetan arintzeko.

Onetsi duzu egin zaitudan eskaintza; ordaiñez, zillegi utz nazazu, Yauna, ene ezagutza handienak zuri bihurtzerat.

Eskerrak emanez zure nahi onezko geriziari, agertu dut lehia-gehiagore-

kin ene liburua yendien begietarat.

Igurikitzen dut beraz irakurtzailliak onetsiko duela, zuk bezala, horren hedarazteko izan dudan chedia gatik.

Onets tzatzu,

YAUNA,

Zure zerbitzari leihalaren agurrak.

DASCONAGUERRE,

Contseilu Yeneraleko membra.

Bayonan, egina, hazillaren 20an 1866an.

# CAPITULU LEHENA.

---

## ATHEKA-GAITZ.

Harat hunat dabiltzan arrotzek, gure herrietarat helduak Miarritzeco eta Donibaneko itsas hegien edertasunari esker, behiñere ez dute huts egiten gatia Atheka-Gaitzeko erreka fama handirekin aiphatua denaren ikusterat.

Choraturik dagozi arroka kozkor hoyeri buruz; begiztatzen dituzte zeruraiño duazin mendi bibitchi hek, othen lore horiez aphainduak. Iduri du ihurzuriak urratu dituela. Dilindan ageri dire mendi bizkar hoyen gaiñian arroka muthur zorrotzak. Hemen, sehaska zabal batian, Ur-handiak

bere ibai garbiak dabilzka; han erreka illun bat da, trabatua arroka eroriz, zeiñen tartetik borrokan itzuliz baitohazi urak, behiñ yauziz, gero itzulika herrestan suge kolpatu bat iduri.

Gizonaren antzia guduka hari da naturaleza atrebitu horrekin; yadan langilliaren pikotchen harrabotsa aïtzen da zelayan: laster bide handiak alde guzietarat egiñez, errechki yendia bat bertzeratuko da norat nahi eta ikusiko nasaitasuna eta aisia sartzen mortukarazko mendi zoko gordenetan.

Atheka-Gaitzak badu bere mendetako omen ederra, guziek dakitena. Hosiñen gaiñerat makurtua den arroka horren erditik, Errolanek ideki zuen beretzat bide bat; harren itzal handia, gora hegaldatua, dabilla orai ere gure mendien gaiñian. Baiñan Atheka-gaitzak baditu bere orhoitzapen berriak; hoyen orhoitarazteko hartu dut hemeñ chedia.

Yadan ibilli zaiztenak mendi lepho illun hetan, orhoitzen zaizte ikusirik bidechka bat, zurubia bezin tchuta, chingola bat bezin hertsia? Ageri da sigisagan eskuiñeko mendiari gora, egiña kontrabandichten eta etchola goreneko yenden urhatsek.

Zembat gerthakari latz ez ditu gogoratzen bidechka hunek!

Maiz, itsas hegietan sortzen dire mariñel suharrak, oihanetan ihiztari zalhuak, mendi mortukaretan eta herri-mugen auzuan kontrabandicht atrebituak. Bakhotchak dakharke bere baithan sor lekuaren zigillua, eta, maizenik, billakatzen gare mariñel, phertsulari, edo ihiztari, sortzen edo ohitzen garen tokiaren arabera.

Bide gora-beherakor horri hurbill ikusten da, bisianbiseko mendiaren gaiñian, etche churi pullit bat gastaiñdegi batez inguratua; hain eder egiten baitu oihan bazterrian, nola uso ohatze batek ostraill pian!

Han bizi zen gizon bat gorphutzez larria,

besoz zainharta, oiñak zumiaren pare, begi zorrotzetakua, chede borthitzez gainditua, arima ederra, laiñua zaukana, haurrarena bezala, eta bihotza bethi zabaldua behar guzieri.

Egoitza airos eta pullit horren behereko aldian idekitzen dire hosiñ ikharagarriak, leze illunak, otso hamikatuen lekuak. Uhartzian agertzen dire espaiñol mendien koskuak, hoyen azpian zelai choragarri bat zerga guzietarik libro zena. Gure lekutan zillegi ez diren haiñitz gauza, amanden eta presondegiaren gastiguen pian, han saristatuak dire.

Hemen aiphatzerat nuan gizona, sortua ethorki arrunt batetik, yakitate guziz gabetua zen. Bere erresumako debeku eta gastigu hauk, eta aldiz begien azpian espaiñiako lurrian ziren zillegitasun hek, lehiagarrizko agintza horiek, denak iduritzen zitzaizkon gauza desberdiñak.

Gehiago dena zeiñek ere beharko baitzioten adiaazi bere herriko legiek zuten debe-

kua eta garratztasuna, hek berak ziren lehembizikuak haren gogo lehiatua contrabandarat kitzikatzeko. Haren inguruetako yende handiek bilhatzen zuten, hunen kalapuen balakatzia, hartaz hobekiago baliatzeko. Eta zembat andrek etzuten legunki hartzen, haren laguntza beharrian! Hala nola, arrats batez behar bazen bazkari edo soiñu bat, behar ere ziren blundak eta sederia nahikarazkuak : zer egiñ?

Bethan, uso bat airatzen zen, gabaren gerizian, hegalpian eremanez mezu bat; eta, baldiñ illargia, lerratuz bi hedoyen artian, ethorri balitz mendiko bidechka tchutaren argitzerat, ikusiko zinduen Ganich (hori da gure gizon famatuaren izena), bere gerriko gorriaren azpian zainduz, ama batek bere haurrari ematen duen artharekin, aphaindura balios llillugarri hek, agertu beharrak arrats berian, menturaz biharamunian hekien ekharzaillia gastiga zezaketen gizon beren aintziñian.

Ai! zein errech den hutsian erortzia lerraraztaille aberatsak direnian! ezen hekien aintziñian denak aphaltzen dire.

Eta uste duzu irabazia gatik Ganich zabillala tulumbiuen inguruetan, hotza eta berua yasanez, galerna nahasieneri buru egiñez? — Galde diozazute hura ungi ezagutzen duteneri.

Egun batez, lau ehun gizon gerthatzen ziren yakitaterik gabeko hunen manuen azpian. Garden aintzindarieri salatua izan zitzayoten, holako egunez, halako orenez, dentelezko eta zigarrozko metak ekharriak izanen zirela mendia behera. Bethan, garda oste bat bildua da kontrabandicht atrebitu hekien baratzeco.

Laster, mendiko oiharzunek ihardesten dute oihu zizkolatsueri. Kontrabandichtak, bere bide hertsian uste gabetan trikatuak, denak bethan bere etsaien gaiñerat yauzten dire; gardak ere, bere aldetik, gudukatzen

borthizki, baiñan gutiago zirelakotz garaituak dire.

Beriala, garda bakhotcha amarratua da; baiñan aintzindaria sueltatzen da atchikitzen dutenen eskuetarik, hartzen du bere chispa eta muthurrez Ganichi paparua ukitzen dioelarik hutsten dio gaiñerat.

Errebia sartzen da gure yende asaldatuen artian; kontrabandichten nausi hain maitia yo duenaren gaiñerat erortzen dire denak. Baiñan Ganichek, bi eskuz atchikiz bere paparo odolestatua :

« Geldi zaizte! » oihu egiten du, « begira zazue horren bizia; bere egimbidia egin du : zor zaio bizitzia. »

Hitz hauk erran eta, lurrerat erortzen da; baiñan bere begi biziez segurtatzen da aintzindaria eta haren meneko guziak libro utziak direla, nahiz haren arphegia oiñhahatzez desegiña zen, irakusterat ematen zuen haren arimaren edertasuna.

Handik zembeit hillabethen buruan, erran

dugun eskatima yuyatzeco bildu ziren yuyiak Pabeko tribunalerat.

Eta Ganich, bere zauriak oraiño idekiak zituelarik, oiñhatzez arphegi desegiñarekin, agertzen da deskantsuki eta kordokarik gabe haren yuyatzeko bilduak zirenen aintziñian. Laztura batek hartzen du bilkura guzia. Batek bertziak sorkhatzen dute hurbillagotik ikusteko gizon miretsgarri hura. Haren alde mintzatzen direnek hain gora alchatzen dute, non, kontra zirenak bortchatuak baitire haren bihotz ederraren onesterat. Yuyek, eztela hobendun, libro egortzen dute.

Ordu berian, aïtu zen alde guzietarik alegranziazko oihu bat bethe zuena yustiziako yauregia : heriotziaren aintziñian hain handi agertu zen gizon hura sorbaldetan eremana da, zeruraiño alchatu nahi izan balute bezala.

## CAPITULU IIna.

---

## TIPUSTAPASTEKO YAUREGIA.

Eder zaiku guzieri obra ederren aiphatzia: nahiz diren egiñak Erregetasunian, Errepublikan edo Emperadoreguan miretsten ditugu.

Gizon behar bezalakuak, emaile eta leihalak, edozein bandera izan dezan, gure amodiua eta ezagutza merezi ditu; bertzela uste dutenak itsumenduan dire.

Dembora hura zen, zeiñtan Espaiñia ez baitzitaken aphal emazteki baten manuen azpian, ordenu baten medioz erregiña izendatua izana gatik.

Espaiñia sutan zen; odola bazarioen zurruchtan; bandera bat alchatua izan zen, eta hura ikusiz garaituz zuala, gure auzo herriko yaun handi desterratuak don Karlosen laguntzerat abiatu ziren, haren hirrisku eta garaizietan parzun izateko.

Baiñan mugaz bertze-alderatzia etzen gauza errecha; behar zen billatu gizon bat yaun handi hoyeri bidia idekiko ziotena.

Atheka Gaitzeko oiharzunek aiphatzen zituzten ordukotz Ganichen egin ederrak, eta, eskaldunen artian, bakhotchak maite zuen maiz haren laudatzia. Paper egunorokuek, 1834an, goraki erran ere zuten gizon hau, gizon segur eta leihal bat zela. Atzeman othe zitaken lagun segur eta leihalagorik ?

Bizkitartian, zer lanak behar ziren ! — Soldaruz eta gardez bethia zen muga, eta, hekien atzartasunaren loharkatzeko, amarruz behar zen yokhatu. Yeneralak ale fraile, markesak ale mandazain, bertze batzuek ale artzain edo ikazkin, ikusiko zintuen :

kontrabanda gisa berrikua zen hau mugaz bertze-alderatzeko.

Baiñan horra non trabak erortzen diren, mendiak aphaltzen. Nor da gizona gauza espantagarri hau egin zezakena ? Galde diozazute Espaiñol yaun handi, gorago aiphatu dugun etche churi-pullit hura, beldurrezko egun hetan, bethetzen zuteneri. Etchetiarrek bere arropetan bezala, etche hark ere izan zituen bere mudanzak. Atzo, korteko aintzindari nausiaren yauregia zen. Egun, zigillari handiaren egon lekua da. Eta bihar, minichtruaren ostatua izanen da; haren berriak badakizki Ganichek eta beïratzen du haren orhoitzapen ona. (1)

Ez da erran behar, Ganichen etchia karlisten aintzindari guzien biltzar tokia egin zen, eta, yaun handi hoyeri beïtarte on eïteko, nausiak gaiñ behera itzulikatu zuen.

(1) 90,000 liberen paper bat Espaiñiako ontasunen gaiñian.

Pareta kisuz churituak oihal aberatsez gorde ziren, oghiak sederia ederrez eztali, zangazpitan hedatu saihal gozuenak, eta gela guziak bethe gauza ederrez. Ikusiko zinduen, tipustapasteko yauregi llilluragarri huntan, chiminia guzietan kharra, mahaiñ bat bethi hedatua, azkurri yankarenez eta arnorik hurrupagarrienez bethia.

Ahal zituen guziak Ganichek agerian utzi ziozkaten bere etchetiar ozpatueri, eta, maiz, molsa arinegi zuenian, minichtruak, soldaruen hazteko eta pagatzeko, Ganichen molsari eskasa galdetzen zioen.

Ganichek etzituen bakharrik bere izatiak chahutzen; bere sueltotasuna eta bizia ere hirriskatzen zituen don Karlosen tronuratzen laguntzeko.

Gau batez, bere mutillak lagun, bazuan Bayonatik karlisten armadarat mando mulzo batekin, cargatua lau ehun milla liberez. Gaba illun zen, bidian nihor ez; manduen urratsak beizik etzen deus aïtzen.

Bethan, Arrunzko ezkilla dorrian gauerdik yotzen du: bide hegiko hesia zarraztatzen da; itzal handi batzuek zuazineri trabatzen diote bidia, eta boz zizkolatsu batek oihu egiten du: « bizia edo molsa! »

Dichiduzko oihu hortan, Ganich saltatzen da, eta, bere makhilla alchatuz, dio: « Ganichekin duzue zuen egitekua! hurbil « zaizte, ausart ez deusak! »

Bi chispa tirok ihardesten dute mehatchu horri; mando bat erortzen da gaiñeko gizonarekin: bertze manduak trikatzen dire zotzerbatuak, eta iduritzen zayote mandazaiñeri galduak direla.

« Ai! madarikatuak! » dio Ganichek ihurzuriaren bozarekin, eta lehoiñ bat bezala erortzen da arlote hekien gaiñerat.

Kolpeka errebiatu baten onduan, ohoiñak zapatuak dire, eta Ganichek bere gerrikua puskaturik amarratzen ditu denak bere mutillen laguntzarekin.

Ohoiñ horiek, inguru hetan trikatuak, Buhamiak ziren.

Buhamiak, leiñu higundua, bizitze gisa on guzien etsaiak, aurkitzen dire eskal herriko leku auzo-gabenetan. Gizon larriak, begiz belzak eta arphegiz hori, iduzki aldeko kastate zembeitetarik athera ditezke; hargatik nihork ez dakike nondik heldu diren. Ohoiñak, ez acholatuak, badituzte basa gizonen aztura eta ohikunza guziak, indiatarren dohaiñ berezietarik izan gabe. Mulzoka dabiltza, han-hemenka aterpeak ezarriz; amarruzko atchipuz eta ohointzaz bizi dire. Nihork ez daki non sortzen, non hiltzen, non ehozten diren!

Amarratuak zirenek barkhamendu galdetzen dute, eta Ganichek, urrikaldurik, erraten diote: « Barkhatzen zaituztet; baiñan « baldin berriz ene bidian atzematen bazai- « tuztet, zorigaitz zueri! »

Argia urratzerat zuan, karlisten aldaketarat manduak eta mandazaiñak hurbildu zireneko. Ordu ona ziteken orduan Ganichentzat minichtruari eman ziozkan di-

ruen galdetzeko; baiñan etzitzayoen holako den gutieneko asmurik goguat ethorri.

Gizona norbeiten aldeko egintzetan osoki ematen denian, lanaren akhabantzan izan dezaken sariaren orhoitzapenak atzartzen dio bere asmu gordia; horrelako asmuak gehienen aithorra baduke. Baiñan leihaltasun sari igurikimenik gabia, egiazki eder eta miretsgarriagokua da. Holakotan, bihotzak gabilzka, eta horren oihu bereziari yarrekitzen direnak bakhanak direlakotz, guziez merezi lukete izatia ezagutuak eta laudatuak.

Badakizu non aurkitzen ohi diren holako bihotzdunak? Maizenik, yende chehe yakitate gabekotan.

Hekiek ez dakite irakurtzen ere ungia eta gaizkia irakasten duten liburuetan. Nork edo zerk beraz ematen diozkate asmurat holako eginkara handiak? — Guzien gaiñetik, erliyioneko fediak, su zerukua, hekien bihotzetan bethi pichtua dagoena.

## CAPITULU IIIna.

---

## FEDIA ESKAL HERRIAN.

Bai, erliyioneko fediak erruak barna ditu eskaldunaren bihotzian. Yinkuaren chedetarat eskaldunak egiten ditu bere biziko egintza guziak.

Non hartzen du Yinkuaren alderateko siñheste hori? Erliyioneko edergaillluetan, elizetako aphaindturetan othe, zeiñek maizenik llilluratzen baitute basherritarra eta ematen baitiote Yinkuaren handitasunaren asmu handiagoko bat?

Ez...... Ikusazu eskaldun eliza bat: lehembiziko giristionen demborakua bezin

billuzia da, toki bat guti edo gehiago handia, herriko yende ostiaren arabera.

Gaiñian chutitzen zaio ezkilla dorre zorrotz bat; gaiñ guzia teilla gorriz estalia; paretak kisuz churituak; kukurustegiaren gaiñian dire haurren eskolategia eta herriko etchia. Barneko aldian, aldare nausi bat bertze bi ttiki saihetsetan urreztadura mehez han-hemenka eragiñak. Haiñitz basherrietan yaun bailliaren yar lekhua aurkitzen da kantorian. Gisa berian, familia bakhotchak badu bere yar-leku berezia saihal beltz batez estalia eta hill direnentzat ahaidiak haren gaiñian belhauniko othoitz egiten du.

Eskaldun bakhotchak, mezako edo bezperetako demboran, eskuetan izaten du bere arrosariua, zeiñari haiñitz itzuli egin arazten baitio, bi erhi pototsa gurutzatueri maiz musu emanez.

Bethi Eskaldunak berekin du, paparuaren gaiñian, habitua: harekin ausarki ibiltzen da hirriskuak dichidatuz.

Mezaren akhabantzan, bakhotchak bere auzoko lagunari, soillaruetan, agur samur bat egiten dio. Gerthatzen baziñe bi etsaien erdian, burua aphaldu behar zinduke, nahi edo ez, agur egiteko. Meza bat ungi entzunak behar lituzke bethi ahantzarazi liskar guziak, eta bakia eman bihotzian.

Eskaldunak bere erliyioneko siñhestia biltzen du aphezek bere egin ederrez ematen dituzten irakasmenetan.

Apheza guzien adichkide ona da. Norbeit nigarretan, beharrian edo eritasunian bada, apheza agertzen zaio.

Zer gauza ederra aphez baten egimbidia! ene begiak nigarrez bethetzen dire ikusi ditudan hain bertze gauza ukigarriez orhoitzen naizenian. Zembat gauza arraillagarrien ez naiz lekuko izan!... Azken hatsetan zirenak, arphegi deseginãk, oiñhatze miñez hartuak eta etzanak bere pairamenezko eta agoniako oghiaren gaiñian. Ikhusi izan ditut aphezak bere ezpaiñak bat egiten gacho

haukien ezpaiñekin hobeki deskantzarazteko, hekien aithorren biltzeko eta azken nahien aditzeko.

Ez uste izan haren eskua agertzen dela emaitza bat egiten duenian; bakhartasunaz baliatzen da ungiaren gorderik egiteko.

Zorigaitz bat erortzen da familia baten gaiñerat; ama bat nigarretan dago zeren gabetu den bere haurraz; bethan, bera deithua da heriuaz maite dituenen erditik.

Apheza han da, hekiekin nigar egiteko; haren hitz igurikimenezko eta deskantsagarriak aïtzen dire bihotz miñ handienetarik ez in aztandua den ichiltasunian.

Eskaldunak baditu begien aintziñian bertze ikuspen haren erliyioneko siñhestia sustatzen dutenak.

Ikusazu gure basherrietan etche churi eta chume hura, zeiña eskilla dorriaren itzalpian gerizatzen baita; baratze ttiki bat aldian dauka asentuz inguratua. Asentuen gaiñetik sagar onduen ostraillen artian yos-

teta dabilla iduzki-begia. Baratze hartako lorien usaiñ ona hedatzen da inguruan.

Batian etche hori ichil-ichilla dago, zerbeit ohigabeko barnian balu bezala. Bertzian kanta eta irri alegerak handik sortzen dire, aingeruen bozak iduri; han onduan dabillana baratzen da choratua heyen entzuteko.

Etche hortan daude serora eskol-emailiak, azken adi bat erranak bere burhasueri eta herriari, yende chehiaren haurren argitzeko.

Emazteki seindu horiek, fedez gainditualk, eta baratu gabe, bethetzen dute, Yinkuaren laguntzarekin, berek hartu egimbidia. Neskatchen bihotzetan eragiten dute, erliyionaren yakitatiarekin, haren ungiak, ahaiden errespetua, eta berthute beharren hazia.

Eta, arrats guziz, eskal herrian, amek bere bihotzian benedikatzen dute hekien alabak bide onerat plegatu dituen emazte seindua.

Hastetik, haur pobren argitzeko, gizonak

batera bildu dituena sortu zen eskal-herrian. Leiñu onak dire Eskal-herrian, hango odolak aitatik semerat daramatza aztura onak. Sala, haren arbasoa, 808an bizi zen Bardotzeko herrian, haren izena oraiño dakharken mendetako yauregian.

Yan-Batist de la Salle sortu zen, Reims deithu hirian, 1651ako aphirilaren 30an, eta gaztetasunetik yarri Yinkuaren zerbitzuan. Lagunaren alderateko karitate bizi batez sustatua, lehia handirekin haren gogua bethi billa zabillan nondik eta nola zerbeit laguntza eta on ekharriko zuen gizon beharraren alde. Zembat traba etzituen garaitzeko izan yakitate eskasak eta mendiaren aztura goibelek gogortuak! Halere azkeneko, bereganatu onduan bere iduriko zembeit gizon bihotzdun, yakitatez argituak bezin humillak, horiei esker, alchatu zituen orai orotan hedatuak diren, yende beharren eskolak. Bilkura hortako errientak deithu ziren Giristione Doctrinako anayak edo Frerak.

Egintza miragarri horren bidez Aita-de-la-Sallek erakutsi zuen munduari zeren gai ditaken karitate bero bat lagundua denian iraupenezko ongi-nahiaz : horri beira dezatela etsemplu ederren bati bezala ethorkiko beharren alderateko bihotz ichuriek.

Haren ondokuek iraungidurarik gabe segitu dute nausiaren urratsa, eta heyen entseyu oneri esker, berratu da freren bilkura, eta egun guziz handituz eta hedatuz dohazi heyen eskola eta ungieginak.

Zein laudagarriak diren munduari ihes egiñez gordetzen diren gizonak humiltasunian bizia higatzeko haurren eskolatzen, lurreko igurikimenik gabe, billatuz bakharrik langille eta familia buruzagi on, prestu eta suhurren egitia !

Pobren haurrek dituzte hekien artha berezienak, ahal guziez billatzen dute heyen bihotzetan sorraraztia eta finkatzia berthute eta siñheste zuzenak, hobekiago ikas dezatentzat kurayekin eta kordokatu gabe ya-

saiten beharraren eta eskasien herstura eta khirastasun ohituak.

Egiazko gizonen amodiuak holako bidetan ibillarazten zaituzten gizonak, ederra da gora dabilkazuen karitateko bandera ! Agur dautzue eta ezagutza gure herriak. Zueri esker, oraiño eskal herrian ohore du zuzentasunak, erliyioniak; bethi bizi dire Eskaldunak sortzez bihotzian dakharzken aztura onak.

# CAPITULU IVna.

---

## BELZUNZEKO YAUREGIA

### BEIRAKO PRINTSESA

Beirako printsesak utzi zuen bere Salburgeko yauregia bere senhar eta haren armada leihalaren ganat gateko. Ez gare mintzatuko haren bideko ganethorri guziez Belzunzeko yauregirat heldu arte. Yauregi zahar hori zen bi dorre gorez edertua; han bizi zen zaldun ospatu bat mendetako eskaldun leiñu on batetik atheratua, aithoren seme bezala eskaiñi zioena erregiñari leihorra.

Belzunzeko izen hori fama handitakua da

gure mendietan. Gure arbasuek zioten etche hortako seme bat gudukatu zela herri guzia ikharan zaukan heren-suge hegaldun batekin. Lantza choillaz yo eta, eman zioela herio kolpia. Baiñan heren-sugiak, azken hersturetan, yauzi handi bat egiñez, etsaiaren gaiñerat biribillkatu zuen eta itzulika herrestatu berekin Ur-handirat. Ordutik hunat Belzunztarrek ekhartzen dute bere armetan heren-suge beltz bat bandera gorri batian.

Belzunztarren odolak atchiki ditu zaharren suhar eta leihaltasuna; eta heyen egin ederrak kantatu dituzte eskal-herriko pertsulariek. Belzunzen izenak aithor hoberenak ditu bazter guzietan : nork ez daki nola ibilli zen Marseilleko aphezpiku handia izurrite lotsagarrienaren egunetan?

Arrats batez, erregiña solasian zaguen yaun biskondiarekin yauregiko aldamiuan, espaiñiako lurrerat heltzen lagundu behar zuen gizonaren beira.

— « Yaun Biskondia, zure menditarra « gizon segura othe da ? » galdetzen dio erregiñak.

— « Bai, andria; harentzat berme sartzen « naiz; Ganich eskaldun garbi eta leihala da; « karlistentzat orai arte egin dituenek aski « gora diote zer iguriki ditaken hemendik « aintziñat ere haren ganik. Bertze-alde, « andria, leku hautako edozein menditarrak « segurki lagunduko zintuzke. Hemen bizi « dire oraiño gure aiten fedia eta bihotzeko « zuzentasuna; etcholarik tcharrenian ar- « rotzak bethi aurkitzen du aterpe beldur « gabekua. Eskaldun bati gomendatzen ba- « limbadiozkatzu zure burua eta molsa, go- « gotik bizia hirriskatuko du bat eta bertzia « ungi zaintzeko. »

Hori erratiarekin, ederra zen eskaldun biskondiaren arphegia, eta erregiñak entzu-ten zituen atsegiñekin haren hitzak.

Aldamio hartarat begiari zioazkon orota-rik bazter choragarrienak. Hurbillian, hal-

zez inguratu phenze zabal ferdetan arthalde gizenak alha ziren, bildotchak yauzika yostetan, ahariek adiraazten zituztelarik bere gare eta bulumbak. Urrunago, zurtchuri lerro baten onduan, baratche baratche marmariatuz ziuazin chirripa garbienak, eta arbolen osthartetik ageri ziren etchola churi eta pullitak. Goraguan, mendichken panttupa biribill ilharka gorritchez estalietan, ikusten ziren, han hemenka, othe ez-eragiñen lili horiak. Uhartzian, mendi bizkarrak iduzki sartzeratekuaren azken argiez urheztatuak.

Erregiña eta biskondiaren solasak bakhantzerat ziuazin. Printsesak ahanzduran begiak zauzkan aintziñian zabaldua zitzaizkon leku ederren gaiñian. Laster, eskaldun mendi goren bichtak gogoratu zioen bere urrungo herria. Haren arphegi eder eta amultsuan irakur zitazken barnian aldizka sortzen zitzaizkon sentimenduak. Han ageri ziren, orai bozkariua, gero bihotz-illundura; batian igurikimena, bertzian etsimena.

Betbethan, haren gogueta baratzen du bi gizon bekokitsu eta suharren hurbiltziak; biek eskuan dute makhilla, eskaldunen bethi bideko laguna.

Hek ziren Ganich eta Manuel, bi adichkidiak.

« Huna zure segitzaillia », dio Yaun Biskondiak, printsesari irakutsiz bi eskaldunetarik handiena.

Ikustian gizon larri, begitarte beldur gabe hura, aintziñerat hurbiltzen zayoena, paparua ageri, besuak biluziak, bularrak eta gerria sare gorri batez inguratuak, herabedura ez in gorde batek hartu zuen printsesa, ordu arte ohitua bertzela aphainduzko korteko yaunekin.

Fida othe zitaken osoki holako gizon bati, cheletariz eta gardez bethia zen muga baten hurbillian ?

Baiñan Ganichen begitarte ideki eta laiñuak laster suntsiarazi zuen printsesaren beldurdura. Halere orduko, menditarraren

begi zorrotzak ezagutu zuen erregiñaren beldurkondua, eta, bere bizitasunian, irakusten dio printsesari bularrian duen zauri sendatua, bere leihaltasunaren lekuko ez in ukhatuzkua?

« Ez beldurrik izan, andria », dio; « ukhaldi hau hartu duenak yakiñen du ere « bere biziaren hirriskatzen zure laguntzeko. »

— « Guazinberaz », dio erregiñak, « izan « zaite ene gidaria! »

Biharamunian, guziak antolatuak ziren erregiñaren abiadako. Gan zen Belzunze yauna ganat; hunek igurikitzen zuen bere bi eskaldunekin. Printsesak eskuetan zuen kopha aberats bat eman zioen Ganichi, eta hunek aldiz bere adichkide Manueli, beharrirat zembeit hitz erranez.

Ordu berian, Manuel eman zen bidiari.

Erregiña loriatu zen orhoitziarekin laster hartzerat zuala espaiñiako lurretarat zaraman bidia. Arhaiziarekin eskerrak bihurtu

eta murde Belzunzeri, « guazin » dio printsesak Ganichi.

Handik aphur baten buruan, bazuan zaldiz bere gidariaren ondotik, segituz arrosabasate eta elhorri-churien arteko bidia.

Luzez gure bi bidiantiek ikus zetzaketen arbolen gaiñetik utzi zuten yauregiaren dorre zorrotzak. Bethan, gauzak gambiatu ziren : erreka agor, zuhaitz eta belhar gabeko, batian sartuak ziren; han hasten ziren printsesaren bideko gora-beherak.

Erreka hunen buruan, doidoia ageri zen etchola tchar bat, yendek alde bat utzia. Bi oren ibilli onduan, han erregiña zalditik yautsi zen, zerbeit yanharien hartzeko.

Heletatik berrehun urratsetan ziren, eta behar baitzen, gardez bethia zen herri hunen erditik iragan ; Ganichek utzi zuen printsesa aphur bat bakharrik, bera gateko hurbillagotik tokien cheletatzerat.

Yinkuari esker, uste gabian, etzen garda bihirik Heletako plazan ordu hartan;

bero handia baitzen : nihor etzen karrikan ageri. Erresaka badua Ganich erregiñari berri on horren ematerat.

Laster herriaz bertze-alderatu ziren trabarik gabe, eta berriz sartu bazter bidechketan.

Artzaiñek, ikustian andre handi hura, eskaldun arrunt bat lagun, iragaten, aho eta begiak zabalduz, agur egiten zioten teteletuak.

Bizkitartian, bidia ganago eta gehiago tzar biliakatzen hari zen ; etzitaken gehiago zaldiz ibill; aberiak utzi zituzten menditar gizon, Manuelek Ganichen manuz harat cheletatzerat egorri bati.

Gure bidiantiak heltzerat zuazin mendichka baten gaiñerat, noiz eta ere Ganichek ohartu baitzuen garda multzo bat nekez bertze-aldetik mendi bizkarra gora heldu zena.

Bidechkari hurbill gerthatzen zen ardi borda bat, erdi eroria. Doidoia printsesak

eta haren lagunak astia izan zuten harat ihes egiteko. Barnerat gorde zireneko, ikusten dituzte ikhararekin, harrisien arrailladuretarik, gardak heldu zirela hek ziren lekurat.

Zer egin?... Zer billaka?... leiho aphal bat erreka zillo bati buruz idekia zaguen. Ez bat ez bia, asmatu orduko, Ganichek erematen du printsesa leihorat: besoetan hartzen du eta yauzi bat egiten du lezeaz bertze-alderat. Ordu zen, ezen gardak sartzen ziren bordan!

Ethenduak iragan bidiaz eta iduskiaren beruaz, deskantzatzerat zuazin.

Luzegi litake kurrida hirriskuz betherikako hunen tartika guzien erratia. Ganichek printsesari egiñarazi ziozkan ehun itzulien onduan, noiz eta ere urrundanik sentitzen baitzuen, kontrabandichtaren usnarekin, garden galtza urdiñak; bideko asko pirpiren ondotik, landa eta larre, othe eta elhorri yazarkorreri trebes; erregiña eta Ganich

heldu ziren azkeneko heyen aterpetzeko zabaldua zen etche churirat.

Han atzeman zituzten bi emazteki eskaldun gothor, zeiñek behar ziren guziak aphainduak baitzauzkaten, erregiña harat ethorri orduko. Maria eta Rafaela ziren hek: bat laguntzailliaren emaztia, eta bertzia haren arreba.

---

## CAPITULU V^na.

---

### ESKALDUN YAUNSTURAK ETA YOKUAK

Erregiña deskantsatzen hari zen bere bideko neketarik. Urrats bakhar bat aski zuen Espaiñiako lurrerat heltzeko; orhoitzapen horrek espaiñetan lerrarazten zioen zorionezko irria.

Makayan Eliza-besta zen egun hartan; ezkillen errepika alegerek zioten meza errana zela.

Airian zen herriko plaza guzia.

Bitchi ziren egun hartan eskaldun yaunsturak, herrirat egorriak gerthatzen ziren soldaruen arropekin.

Huna eskaldun gizon gaztia : ederra da kantarben seme guziak bezala; gaphelu urdin bat dauka buruan , erdi eroria eskuiñeko beharrirat; maipolisa sorbalda batian, gorphutza lichto eta chuchen gerriko gorri batez inguratua; soiñeko athorra elurra baizen churia du; birazka zillarezko botoiñek dauzkate haren athorra mahunkak eta batek fola; zangotan espartiñak gurutzekara zinta gorriz amarratuak; makhilla bat eskuan dabilka, noizetik noizerat itzulikatuz *Tambour-major* baten bekokiarekin.

Horra gizon zahar bat; hura ere estalia da gapheluaz, makurtua daukana kopetaren gaiñerat; buru gibelian illiak luze ditu bizkarra behera, lege zaharrian leiñu oneko gizonek bezala; haren athorra churia gizon gaztiarena bezala, ukharai lephotan atchikia da; maipolisa ere artha gutirekin sorbaldaren gaiñian emana; galza-motchetan da; galzardi illezkuek gordetzen diozkate bere zainhartak, eta, zillar burla distiantez ber-

reginduak dire haren belhaun-lepho eta zapatak.

Huna emazteki multzo bat.

Neskatcha gaztiek gerriak mehe eta lerden dituzte, arphegiak eder eta begiak bizi arraiziaz gainditúak.

Hunek burutik behera dauka mantalliña beltza, zirikuzko pumpollo bat dilindan duakona kopetaren erdirat; oihal merkez du soiña. Bertze horrek beso gaiñian darama bere mantalliña; buruko mokanes airosaren azpitik, ageri ditu kopetaren gaiñian bi aldetarat ille beltz lodi eta ungi legundu ederrak; lephoko ttiki pullit batek estaltzen diozka sorbaldak.

Eskaldun emazte adiñekuak, aphaintzen denian, ematen du buruko churia, pertal bat dilindan buru gibelerat. Haren yaunstura illuna da eta edergaillurik gabekua; lephotik dilindan dabilzka urhezko gathe bati behera, bihotz eta uso hegaldun handi bat, gurutze egiña. Bertze batek burutik oiñe-

raiño duakon kapa beltz batez gordetzen ditu bere bisaya eta yaunstura guziak.

Baiñan huna non heldu den gizon gazte andana bat, ełkhar dichidaturik pillotarat; eskuen sartzen hari dire eskularruetan.

Piłłota yokua da Eskaldunen yosteta bereziena. Deus ez da hain lehiakorrik. Harritua zaude, ikustiaż yokariaren bizitasuna eta załutasuna, halaber haren bekokia. Batian, chacha on bat egin nahiz, orkhaitz baten yauziak egiten ditu; bertzian, zezena iduri, furrundaka pilloten gaiñerat erortzen da; bertze ałdiz, lehoiñ batek baizen, burua gora, badabiłła eskularrua beso azpian emanik, paso eder bat egin ondoan; alde guzietarik begiztatua da.

Demboraz Erroman ziren lege egille zahar hek baizen aire garraztakuekin biltzar bat izendatua da yoko hartako yustizia egiteko. Hekiek harat edo hunat gauza yuyatuz geroz, ez da nihor ausartatzen marmariatzia, nahiz hekien errana makurra litaken.

Eskaldunaren bertute ederrenetarik bat da, bethi burua aphaltzia buruzagien aintziñian; Yinkua mintzatu balitz bezala.

On handiak daraizko yoko horri. Gorputzian hedatzen dituelarik zalutasuna eta indarra, sorrarazten du garai-nahia, eta gizonari ematen diozka bekokia eta duen ahalaren ezagutza. Bazterretik duazkon chistu eta bibek berotzen dute haren kalapua. Yokolariak indar handirekin egorri pillotari buruz, ikasten du bere bularren zabaltzen ukhaldi kaltekorraguerі.

Zer da aphaindura distiantetan agertzen den oste hori ? Hau da pastoraleko gazteria.

Pastoralak edo kompartsak eskaldunen yosteta maitagarrienak izaten dire. Hekien egin moldiak hartuak ohi dire liburu seinduetarik, alegia zaharretarik, edo Arrolanen, Moro eta Napoleonen orhoitzapenetarik.

Eskal herriko koplariek moldatuak, pastolarek dakharkete gure ethorkiaren sigillua,

eta aberats dire gauza onkigarri bakhan gerthatu eta maitagarrien aiphamenez. Urthien eta munduko nahasduren gatik, bere mintzaira, bere ohikuntzak eta mendetako omenak, ontasun sakratu bat bezala, oso atchiki dituen populu bereziaren noizbeiteko ethorki goraren lekukuak dire.

Yosteta horiek plazaren erdian egiten dire; hortako ederki aphaindua den leku baten gaiñian, chirula eta tambulina soiñuz.

Hastian, erranzute luze batek yakiñarazten du zer erabiltzerat duazin pastoralian. Gero, birazka edo gehiago aldian agertzen dire aiphu ederrez mintzo direla pastoraleko beztituak diren gizon gaztiak. Loria da ikustia zein gozoki eta kordokarik gabe bakhotchak derasan errateko duena.

Eta pastoralerat edo pillota partidarat bildua den yendia, solasian, yostetan, alde batetik bertze titchua titchuari, irriz eta bat bertziari oihuz aditzen dire eskaraz.

Betbethan, haro horren erdian, harrabots

illun bat aditzen da, panderu urratu batek yotzian duena iduri. Makayako herriko-mutilla da, zerbeiten erantzuterat ethorria, bere boz eihar-marrhantarekin.

Ordu berian, oihu guziak ichiltzen dire, yoko guziak gelditzen.

Aditzagun zer othe dioen :

« Més habitants dé mon pays,
« Par l'ordonnancément dé messiu lé
« Maire, lé poublic il est erréprévenu que
« lé fâme, grand dame de don Carlos Quinto,
« il est caché dans quelqué coin ici, dans
« lé village dé Macaye. Il est errésousen-
« tendu qué si l'attrape il est erréussie,
« grand errécompense il sera donnée à son
« ratrappement. »

— « Tiens ! on parle donc français « ici » (1) dio soldaru batek.

(1) « Ene herriko herritarrak,
« Yaun bailliak adiarazten zaituzte fama dela, Don
« Karlosen andre handia zembeit zokotan hemen

Beriala, gizon bat ostia utziz badua hesi artetik Ganichi erraterat zer hirriskutan den erregiña; hura zen Manuel, Ganichek, Belzuntzeren yauregian berekin zuen laguna.

Yendiak han hemenka multzokatzen dire, elkharri buruz, begiak kechu.

Zer gerthatu othe da herrian ?... Chango-ariñek (hori da letra barrayatzaillia) zer berri ekharri othe du ? Orok begiz billatzen dute, ezen Chango-ariñ herriko berrikaria da.

Elkharri beira daudelarik, zerbeit yakin nahiz, errienta agertzen da plazan, gaphelua kopetan aphaldua, begia illun, goguan zerbeit balu bezala; ageri da ikasi duela oraiño gutik dakiten berri handia.

— « Yaun errientak badakike zerbeit ! » diote, eta bethan yendiek inguratzen dute.

« gordia dugula Makayako berrian. Eta, nik erran « gabe, yakin zazue erregiña hori lotuko duenak « sari ona izanen duela, bere atzemanzarentzat. »

— « To ! zer duk hori ? zer ? frantsesez mintzo dituk hemen ere ! » dio soldaru batek.

Denek batian galde bera egiten diote; haren ahotik atheratzen diren hitzak lehia handirekin bilduak dire.

Errienta herriko Yinkua da.

# CAPITULU VIna.

## GALERNA

Yinko handia, zer gaba! . . .

Haizia chistuka hari da, ihurzuria karraskan. . . . . Erran liteke lur behere huntako mamu ikharagarri guziak marrubiaka bat bertziaren gaiñian multzoka bere errayen zarraztakatzen hari direla.

Chimista chimistari yarrekitzen da erresaka latzgarri batian. Uhartza batian sutan da; bertzian leze zokolu bat baizin beltz da gaba.

Batian ihurzuriak adiarazten du harrabots idor eta desberdin bat zapartatzen den

chispa baten kolpia iduri. Bertzian galernak marrumaz dago latzgarriki.

Hori da zeruaren boza... dio, aizak:

« *Hire gaiñeko aldian eta muga gabeko*
« *lekuan* NI NAUK ! »

Yinko handia, ukha othe ditake zure izatia, zure hasarredura hola agertzen denian ?

Chichari herbailla lurraren gaiñerat arthikia hare bihia mugarik ez duen lekurat bezala, zer hintake baldiñ ez bahu hire arima, baldiñ Yinkuak ez bahintu eman hire handitzekotzat bere Yinkotasunaren hats bat ?......

Uholdiak erortzen dire yauts ahala, chirripak ibai billakaturik trumbillatzen dire mendiaren gorenetik ; arrokek, erruetarik atheratuak, elkhar kuskatzen dute harrabots izigarri batekin. Zangopia ikharatzen da..........

« Ay ! izitzen naiz, izitzen naiz ! » oihu egiten du printsesak dena deboillatua eta nahasia.

Baazuza eta harrizko uri bat heldu da etcheko beriñen cheakatzerat eta galernaren hasarredura berratuz dua. Haiziak altchatzen dituelarik athiak, zapartan zabaltzen dire.

Erregiña dohakabiari mainu eta altamak agertzen zaizkola iduritzen zaio.

« Ene Yinkua! ene Yinkua! othoi, ene
« egunak beira zatzu...... Horra solda-
« ruek non inguratzen duten ene etchia...
« Hekien beiratziek sua arthikitzen dute...
« entzuten ditut hekien paturriak... oihu
« egiten dute: Heriotzia erregiñari!... Ez,
« ez dut nahi hill lur arrotz hunen gai-
« ñian... nere senharraren ganik urrun...
« laguntzarik gabe... othoitzik gabe...
« Ai! zembat pairatzen dudan, ene Yin-
« kua!... urrikalzakizkit... »

Eta Beirako printsesa erortzen da lurrerat hebaindua, ezindua.

Zeru hasarretuak lurra ezeztatu behar

zuela iduri zuenian, gorphutz larriko gizon bat bazuan, galernak errozgora ezarri arbolen erditik, putzu eta arrokeri trebes, urrats suharrian, nahiz etzuen bere bidiaren ikusteko chimisten argia beizik.

— « Yinkuak maite gaitu », zioen gizonak, « uholdezko gau ikharagarri hau gabe, « erregiña galdua zen !... gaicho erregiña ! « bakharrik gure etchian, zahar ezindu bat « eta haur chume bat sehaskan lagun, zer « griñetan othe dago !

« Haren aldian egon banintz, beldurra- « ren khentzen lagunduko nuen; baiñan « laster deskantsatuko dute emanen dioz- « kadan berriek; gaba ona izatu da; esker- « rak dauzkitzut, ene Yinkua; egin gaitutzun « horrelako gau hunentzat ! »

Eta Ganich bihotz handikua aintziñat zuan azkar eta alegera, galernaren pian, haize, uri, harri, leze, ihurzuri eta mendiari behera erortzen diren arroka zathikatuen gatik. Zerua bera dichidatuko zuen,

ez balimbalu izan Yinkua baithan zuen siñhestia.

Norat othe zuan bada? Ungi baitezpadakua behar zen hark egiteko zuena, kasik huts ez in egiñezko hill hirriskurat bere burua hola largatzeko! Eta zertako eskerrak bihurtzen ziozkan Yinkuari, zeren gau hartan haren oiñetan sorrarazi zituen leze eta tulumbio hek?

Bazuan karlisten armadari bere erregiña maitia helarazteko bidien egiterat; eta, Yinkuari eskerrak ziozkan, zeren, dembora izigarri horri esker, alfer billakatua egiña zen gardien atzartasuna eta hurbill yokotik kampo emana erregiñaren ihesia.

Badire gizonak ungirat ekharriak, deusek ez in baratuak; zembatenaz handiago baita hirriskua, hambatenaz gogorrago dire hekien iraupena eta kalapua; hirriskuak berratzen ditu.

Norbeit hersturan lagundu behar bada uretik edo sutik athera; billazazu holako

gizona; gerokogerorik gabe yauzi egiñen du ithotzen edo suan denari esku emateko.

Manuel plazatik ethorri zenian, Ganichen etchian printsesa bakharrik zaguen nausiarekin gizon zahar bat eta haur eri baten aldian. Maria apur bat zuela gana zen haurraren sendagarri zerbeiten billa; Rafaela ez baitzaguen Ganichekin, eta bere etcherat abiatua zen.

Manuelek hirriskuaren berria ekhartzian, Ganichek gan nahiko zuen beriala gerize seguragoko baten billa; baiñan, orhoituz laguntzarik gabe bera utzi beharko zuela erregiña, gelditu zen bere emaztia ethorri arte iguriki behar zuela.

Bizkitartian, gaba beranduz zuan; hedoi beltz eta lodiak metakatzen ziren uhartzian, chimistak hari ziren eta ihurtzuriaren orro illuna urrunian. Ezagun zen dembora tzarra hurbill zela.

Bi oren luze iragan ziren, eta Maria etzen oraiño etcherat ethorria.

Etzitaken gehiago iguriki; behar ziren bidiak egin erregiñari. Ganichek, emanez bere mandatuak Manueli, egortzen du bere arrebaren gana; gero, bere bihotzari bakharrik yarrekiz, badua kamporat, othoitz khartsu batian erregiña Yinkuari gomendaturik.

Orduan, adarairia lehertu zen iharrusiz bazter guziak, eta Maria, galernaz bidian atzemana, aterpetu behar izan zen, etchetik urrun.

## CAPITULU VII$^{na}$.

---

## SOLDARUAK MAKAYAN

Galerna orruaz errebian zaguenian, eta erregiña erreberian nahasiari alde guzietarik mamu eta itchura izigarriak iduritzen zaizkonian; Ganichek, hirrisku guzien erditik, Yinkuari eskerrak zituenian, alegeratua ere gau lotsagarri horren bichtan, zeren hain ungi gordetzen baitzituen haren chediak; bertzelako zerbeit gerthatzen zen Makayako etche batian.

Irakurzailliak utz gaitzala etche hartaz mintzatzera; ezagutaraziko diogu hola nolakua den eskaldun baten egoitza.

Bi ichuritarat teillatua, estalia du teilla gorriz. Aintziñian arkamasez han hemenka ditu leiho desberdiñak, kampoko leihuak gorriz, gurutzen artetik leiho-begiak, eta, sar-hirian, athe handi bat elizakua iduri. Athe horren gaiñian bada gurutze fika bat. — Toki batzuetan, gurutze fikaren orde Ama-Biryina bat, edo, egin edo erosi duen nausiaren izena eskribuz duen harri berezi bat.

Deusek ez du sentimendu hobiagorik sorrarazten eskaldun etche sartze horrek baiño.

Etcheko atalapustan bada ur benedikatu untzi bat: eskaldunak elizarentzat duen errespetu berarekin beiratzen du bere egoitzari.

Erran dugun athe hortarik sartzen zare eskaratza deithua den leku zabal batian; harat etcheko yaunak biltzen ditu bere laborantzako erementak, han ere udan yotzen ditu ogiak eta negu hastian churitzen arthuak. Eskaratz horrek egiten du etchia bi alde.

Ezkaratzerat bilduak, Makayako etche hartan, soldaru multzo bat yarria zen han pichtu zen su baten inguruan, elheketa herrian denak mintzo ziren gauzez, pipa khiretsen kheak egin hedoi minkorraren pian.

Kaporal Hitzederren elhek, ahua zabaldurik beira-zauzkan inguruko soldaruak.

— « Zer hau ! milla debruko dembora !
« Huna non gaituzkan hemen ihi chorros-
« ten ! Nola lot, gaur, printsesa eta Ganich
« madarikatu hori ? »

— « Errak, to, kaporala », dio soldaru batek, « zer duk bada otso leku huntan yar-
« rekitzen diagun printsesa delako hura ? »

— « Huna, muthillak, nahi zaituztet
« cheheki gauza horren gan-ethorriak ira-
« kutsi, baiñan ichill-ichilla egotekotan. »

— « Halabiz ! hori aski balimbaduk,
« kaporala, mutu gaudek charbuak bezala. »

— « Ez diat erhia surat emanen hala
« dela ni erratera nuan egiaren egia, ez

« nauk aitua baitezpada politikan; bertzalde
« guti achola diat printzen eta erregen ar-
« teko mokokez. Hargatik, fransesez *gatza-*
« *likia* deithu legia etzaukat arras makurra
« dela, iduritzen ere zaitak nausiari ungi
« duazkola galtzak eta bizarra.

« Baiñan hor ere gerthatzen dituk batzue-
« tan noiz behinka istripuak; erranen zai-
« tuztet gauza entzun diadan bezala, gure
« kapitaiñaren ahotik; hura zerbeit baduk
« eta hark erraten duena hala.

« Bazukan behiñ Espaiñian errege bat,
« Ferdinan zazpigarrena deithua. Eta, er-
« rege hura ezkondua zukan asko bezala.
« Bada, erregiak ere zahartzen dituk bertziak
« bezala; behar diek guk bezala heriuari
« muga denian bere zerga handi hura bi-
« hurtu. »

— « Sorgiña ! ! Halsuko erretora baizin
« ungi mintzo duk gure kaporala ! »

— « Beaz, egin behar zian bere ordenua;
« baiñan emaztekiek aphur bat goiti beiti,

« dakizuen bezala, etchian nausi nahi dituk
« izan. »

— « Ha! kaporala, nere emaztegaya *Kattalin* ez duk behinere ene etchian nausi izanen. »

— « Hetchak ahua, birika handia, hire emaztiak sudurretik ibilliko hau. Larrerat! larrerat, murde Halsuarra.

« Hortarakotz beaz, erregiña *Kristiñak* nahi zian bere alaba *Isabelari* korua eman; hori deitzen duk liburutan *korua killo billakatzia.* »

— « Errak, kaporala, zer iruten ditek erregiñek, illia edo haria? »

— « Behauk hortik, Halsuarra: Españiako erregiñek ez ditek urhia eta seda baizik iruten.

« Zauzte ichilik, zuek. Badikek orai Españiako erregiñak aski hari bihurtzeko; ez omen baituazi hainitz gaizki karlista puttiko hoyek. Baiñan bego lo politika.

« Erraten gindian beaz hastian *Kristi-*

« *ñak* nahi zuela koruatu bere alaba
« *Isabela.*

« Baiñan hola nola Frantz*ian* gizonak
« izan dik Espaiñ*ian* kaprestua bethitik es-
« k*uan;* don Karlosek behar zian tron*uan*,
« Ferdinanek ez balu orden*uan* bertzela
« egin, legia porrokatz*ian.* »

— « Emak hor kaporala, nola huan
« phertsutan! »

Eta kaporala, balakatua hitz hoyez, hampatzen da, karrakatzen du zintzurra esthul egiten, eta gero dio:

« Ikusten ahal duzue nola loriatu othe
« zukan don Karlos erregeren ordenu har-
« taz. Haren ez-baitzitian gutiak; yarri zitian
« malzurki haren alde. Bildu tiek, oiñez
« eta zaldizkuak, gogora, non nahi, metaka.
« Geroztik, su eta yo, nausitzetik nausitze-
« ra, nahi bezala, duazila ziotek; hori ikusi-
« rik, don Karlos bera gan omen duk bere
« laguneri erraterat : « Huna hemen nauk
« ethorria, zuek bezala zuekin egiterat! »

— « Biba hura ! eztik harrek bihotzian « urrik ! » diote alde guzietarik soldaruek, « ez diek errege guziek horrek bezala tiro- « karat laster ! » — Eta aditzaille denak esku yoka hasten dire.

« Baiñan errege bat etzintakek egon do- « nado. Hortarakotz beaz don Karlos es- « kondu duk Beirako printsesaekin ; andre « handi harren ondotik gabiltzak gau ma- « darikatu huntan. Ganichen etchian duk « gordia, ordian, ichill ichilla, bat eta ber- « tzia gure saretan hartu behar ditiagu. « Ezkontza hori, en'ustez, Londresen eina « izan duk ; omenak hala dituk.

— « Barka-nazak, kaporal maitia, hire « kalak'ederra hausten badiat ; ordian, nola « eskontza hori eina izan ahal duk Londre- « sen, don Karlos hemen denaz geroztik ? »

— « Gauza hori eina izan duk liburu za- « harretan erraten den bezala : *Prokura-* « *zionen operazioniaz.* »

— « Demuntsuen misaya ! zer duk hau ? »

Hitz hori ahotik atheratu orduko kaporalak bere aditzaille leliak begiztaten ditu ikusteko zer ondorio duen haren elhe bereziak !

Denak teteletuak dauzi ikusiz bere aintzindariaren baithan holako yakitatia. Aphur bat badaudez guziak ichilik.

Azkenian, guzietarik ausartenak :

— « Errak bada, kaporala, zer duk pro-
« curazionen operazioniaz eiten den ezkon-
« tza ? »

Kaporalak, apur bat goguetan egon onduan :

— « Emagun, dio, orai Makayan hai-
« zela, eta hire emaztegaya Kattalin Hal-
« suko herrian dukala; egortzen duk Hal-
« suko oihan-zaiña auzaphezaren aintziñat,
« zeiñari ihardesten baitio *bai* hiretzat. »

— « Alaintso ! zer ezkonzeko moldia!
« nere emaztegaya Kattalin hartuko diata-
« nian, nihori agertuko nauk, Yinkuak nahi
« badu, Halsuko auzaphezaren aintziñat.

« Ez diat ordainik eman nahiko ! ez hala « fede nik ! »

— « Behiñ ezkonduz geroz, » dio kaporalak, « ez othe duk emaztia senharraren « ganat behar ? Hortarakotz, printsesa et- « horri duk mug'alde huntarat don Kar- « losi hurbilltzeko, eta gu haren baratzerat « manatuak gaituk.

« Baiñan, guziek dakizuen bezala, ba- « duk hemen Ganich deitzen den gizon de- « bru bat, gutaz trufatzen dena, omen, « bere etchian gordiarik printsesa; eta guk « nahi edo ez, haren laguntzarekin don Kar- « losek alderat igurikitzen dik bere andre « hori. Ikusiko diagu bâ !

« Gaurkuan, gaur goitik, hemen gaituk « bihar arte, dembora madarikatu horri « esker; baiñan, bihar goizian, argi pirrin- « tan, ganen gaituk Ganichen etchia gaiñ- » behera itzulikatzerat. »

— « Zer kalakaren akhabantza ederra ! « Baiñan bihar, biharko gisa. »

— « Orai, muthillak, akhabo duk isto-
« riua; gazin bakhotcha gure kamastra-
« rat... Baiñan, atabala eta turruta yo-
« tzian, EN AVANT, MARCHE ! »

## CAPITULU VIIIna.

---

### PRINTSESAREN IHES EGITIA

Ferrakan tzar eta bortitzeri yarrekitzen dire maiz dembora eder eta haize gabiak. Iduri du zeruak, permagune bortitz batian, higatu duela bere hasarreduraren hedadura guzia.

Gutituz gutituz, galerna ichiltzen da; urrunian entzuten dire oraiño harrabots aphalduz duazinak, eta chimistek, mendiak zafratuz, barrayatzen dute argi churista bat: erran litake miraill bat, zoiñak urrunerat egortzen baitu hartzen duen argia.

Noizetik noizerat ur ttintta batzuek, zitoitzak iduri, erortzen dire zirimolak egotzi ez dituen arbolen gaiñetik, eta horrek irakusten du uria gelditua dela.

Haize ezti batek ferekatzen du ostrailla; igela, beldurrak ahantzirik, agertzen da ur gaiñian, eta kalakatzen du zeskapian; errechiñoleta bera, oihaneko kantari ederra, harrek ere bere izialdura ahantzirik, urrunerat adiarazten du bere boz bizi eta gambiakorra.

Haize ariñak urruntzen ditu edoi eta lanhuen azken ondarrak. Zerua distiant agertzen da bere ez in konda ahal ditazken izar guziekin, eta haren irriak erraiten dio lurrari Yinkuaren hasarredura yabaldua dela.

Yinko handia! zein ederra den izarrez eragin duzun zeru hori eta zein ungi mintzo den zure izatiaz begiak ez in hel ditazken neurri gabeko lekuetan! Zuk egin duzu gabaren estalkia harri biziz igeri; zuk barrayatu ditutzu ondo gabeko eremu goretan idus-

kiak ostez; ez bakharrik zure handitasunaren irakusteko, baiñan ere gizonari zure ontasunaren frogatzeko, aintziñetik hari yastaraziz ethorkian agintzen diozkatzun zorion gozuak leihal egoten bada zure legeri.

Zertako gizona altcha litake zure contra? Haren bizia suntsitzen da itzalaren pare; lur huntako gozamenak iheskorrak eta ezdeusak dire; hemengo zorionak itchura hoberenekin funts gabiak, hasi orduko begien engañatzen airatzen dire haize chumenak dareman khea bezala.

Eta, bizitik landa zer geldituko da?

Harri bat, guti edo gehiago aphaindua, lehen egunetan ahaidiek arthez inguratzen dutena, estalia biharamuneko histuak haiziak erematen dituen lorez.

Demborak higatzen eta iresten du harria bera, suntsiaraziz gaiñeko eskribu ozar eta ez deusak, eta marmolarik gogorrena laster hauts eta erhauts billakatzen da.

Bidiantiak ostikatzen du hobi hura zen lekua.

Eta gero, zer gelditzen da ?

Deusik ez...

Zer diot ? Gauza bakhar bat gelditzen da gizona gan onduan, egin dituen ungien orhoitzapena : orhoitzapen hori bethi bizi urrikari gabe bertze guziak ezeztatzen dituen urthien iragantza lasterrak leiñutik leiñurat eremana.

Galernaren patarrakan loharkatu gizona atzartzen den bezala, emadura ichilla ethortzian ; orobat Beirako printsesak kobratu zuen ezagutza bakia sortziarekin haren inguruan. Begiak idekitzen ditu : oraiño ikusten dituela iduritzen zayo izialduran iduki duten mamu eta itzal beldurgarriak ; laster asmu latzgarri hek itzaltzen dire ihesi egorriak zaguen gelako leiho erdi idekitik ethorri argidura maitagarri batek. Yeikitzen da eta bereganatua bihotz altcha-

garrizko argi hartaz, badua leihorat : beha dago gau ederrari eta haren gogua bichtan zuen ikuspen miragarriak sarrarazi zuen gozotasun hoberenian. Ferekatzen du iragan egunen orhoitzapen arraya.

Amesten ditu Salzburgeko yauregian haren lehen urthiak loriatu zituen gozamen eztiak ; ikusten du egun batez korua eskaintzerat ethorri zitzayon mezularia..... agintza ederrak egortzen ziozkan orduan ethorkiak.....

Eta, fama hedatu zenian, haren senharra sanoki zuala bitoriaz bitoria, zer lehiarekin etzen abiatu haren lorian partzur sartzeko!..... baiñan, behatuz bere orduko hirriskueri, begiak busti zitzaizkon nigarrez. Bakhartasunak lazten du ; hats gorapen du eta hurren etsitzen ethorkiaz. Aldian balu bederen bere laguntzaille ona ! Traba lotsagarrienak non nahi ikusten ditu bere bidian. Garaituko ahal othe ditu Ganichen kalapuak ?..... Zein luzia den eta berant heldu libertatia ekhartzen duen orena !

Betbetan aditzen du harrabots chume bat. Beha dago; baratche baratche harrabots hura berratuz dua, zerbeit hurbilltzen balitz bezala. Duaziñen artha guzien gatik ichill ibilltzeko, urratsak zagun dire bideko harrietan. Izialdura lotzen zayo berriz ere. Nahi luke ihes egiñ. Etsaiak heldu othe dire haren gatibo billa? Baiñan laster izarren argi herabian ezagutzen ditu Rafaela, Ganichen arreba eta Michel haren muthilla. Dudarik ez da, hek dire..... Horrek alegeratzen du printsesa bihotzerat ekharriz esperantza.

— « Egiaz othoi, Rafaela, zu zare? » erraten dio ahopian.

— « Bai, andria, heldu gare, Michel eta « biak, zure laguntzerat. »

— « Eta Ganich, gure Ganich? »

— « Anayak egortzen gaitu zure ganat. « Ez in ditake gau huntan ibayaz bertze- « alderat gan. Zato beriala gure etcherat, « eta bihar, argi urratzian, ganen gare

« Ganichen ganat : igurikitzen gaitu, har-
« rek eta guk bakharik dakigun toki gorde
« batian. »

— « Baiñan nola ilkhi zure etchetik ni-
« hork ikusi gabe ? »

— « Errech da. Ramona gaichua, gure
« auzua, atzo hill zen : goiz huntan berian
« ehortziko dute, emanen gare Ganichen
« gorde lekuaren hurbilletik iragan behar
« den haren ahukuan. Anayak nahiko zuen
« zurekin gan, baiñan badakizu muga sol-
« daruz eta gardez bethia dela, eta haren
« libertatia baliosegia orai behar gabe hir-
« riskatzeko. »

— « Zer bihotz handia ! . . . eta nola di-
« chidatu dituen gau huntako hirrisku gu-
« ziak ! osorik heldu othe da ? »

— « Ez beldurik izan, andria ; Yinkuak
« begiratzen gaitu. . . . . . Baiñan, egizu,
« othoi, laster ; gure adichkide Manuelek
« erran du ez dela den gutieneko dembo-
« rarik galtzeko. Orai dembora atheri baita,
« laster hunat litazke *galtza gorriak.* »

Handik lekhora, erregiña eta haren bi lagunak ilkhi ziren Ganichen etchetik eta abiatu sasi artetik gordez zuan bidechka batian : handik ichill eta errechkiago ibill baitzitaken. Aphur bat gure bidiantien urratsa bakharrik ezagun zen gabaren ichilltasunian.

Gero etzen deus gehiaho aditu.

---

# CAPITULU IX^na.

## GANICHEN ETCHIAREN SETHIUA

Erregiña eta haren bi lagunak Rafaelaren etche alderat zuazin demboran, Makayako etche batian, gizon bat atzarria zaguen, nahiz gaba berandua zen.

Gizon hura, yarria paperez estali mahaiñ baten aintziñian, burua bi eskuetan, barna sartua zaguen bere goguetetan. Haren aldian pichtu chiribitak, bere argi goibelaz illumpian utziz gelako inguruak, beltzian zauzkan gizona eta hango gauzak.

Billuziak ziren hango harrisiak; bakharrik han hemen kausi zitazken zembeit erre-

taula bitchiki batzu-bertzen hurbill ezarriak, hala nola yudu erratua Napoleon zenaren aldian, lehen emperadoriaren zembeit gerlen auzo eta Yesu - Christoren pichtia debru dirukhoyari buruz; zembeit zurezko kadira, mendetako aitasuen egunetan han ezarri kutchak. Bazter batian, dentelaz azpildu oihal churiz estali mahaiñ chume baten gaiñian ezarria zaguen igeltsuzko Ama Biryina bat, arrosariua lephotik behera, burua lore horiz koruatua. Bertze bazterrian, oghe zabal bat, familia oso baten etzan gai litakena, gora alchatua: iduri zurubia behar lukela harat heldu nahi denak; erridauak demborak histuak funts arrosa kolore baten gaiñian lore argaillekin, buhurdiaren aldian, beriñazko ur benedikatu untzi bati lotua da erremu aldazka ihartu bat. Athiak gakhorik ez du: alfer baitire eskaldunen artian etchien zaintzeko artha bereziak.

Herri guzia lo denian, iratzarria daguen

gizona Burrumba kapitaiña da, Makayarat egorri soldaruen manatzaillia. Kapitaiñ hau, illun eta kechu, burua hartua du egiteko dituenez : Yeneralak eman dio gau hartan berian Beirako printsesaren baratzeko manua; baiñan bezpera arratsian lehertu den galernak bortchatu du biharamunerat egortzeko manatua zayoen egimbidia. Aintzindari hau, zahar eta higatua bastapian, ohitua da kuchian egiten goragokuez errana zayoena. Beldur da urrunegi gan othe den oraikuan. Behiñ armetan ezarri nahi zituen beriala bere soldaruak kampo, baiñan, uri eta lohitan, bide guziak leze eta intzurra egiñak dire. Nola aintziñerat higiaraz galde handi gabe soldaruoste bat illumpian ?

Gogueta horrek apur bat barnia eztitzen dio, baiñan laster bertżelako gogueta berriek sethiatzen dute. Yeikitzen da bere kadiratik eta harat hunat badabilla gelan barna kechadura handienian.

— « Handia da bethetzeko dudan egim-
« bidia, » dio bere buruari; « erregiña
« baten lotzia ez da nola nahiko eta egun
« orotako lana: nola ere egiñen baitut,
« hala ditake ene ethorkia. Buru on egiñez
« gauza horri, gomendant naiz gurutziare-
« kin. Baiñan horien ardiesteko eman be-
« har dire ene zuhurtzia, adimendu eta fin-
« tasunaren frogak .. ordian zertako ke-
« cha? Berri guziez ungi yakindua naiz.
« Ganichen etchian da printsesa, segur da
« han lotuko dugula. Bertze-alde galernak
« hura ere bortchaz egon-arazi du bar-
« nian... Baiñan Ganich gizon maltzurra
« da, badakitza mendietako itzulika gor-
« denak: ez othe du yadan erregiñari ihes
« egiñ-arazi? »

Eta gogueta illunetan barnago sartua kapitaiña lasterka bezala dabilla kopetari yoka.

Laster berriz, bertzelako goguetak heldu zaizko.

— « Ez, » dio, « ez ditake!.... emaz-
« teki flako eta beldurti bat ez in ditake
« bidian abia holako gau madarikatuan,
« eta, argi pirrintan, hartuko dugu prin-
« tsesa arthe batian bezala. Ai! Ganich,
« Ganich puttikùa, ez dakik norekin ditu-
« kan egitekuak! Alfer izanen dituk hire
« maltzurkeriak; hire amarruek argi ho-
« biez disti-araziko ditek nere atzarta-
« suna! »

Aintzindaria berriz yartzen da; su eta khar burua berotua eskribatzen du kordokarik gabe bere soldaruentzat erantzute hau:

« Soldats!

« Le ciel s'est montré un instant jaloux
« du succès réservé à nos armes.

« Un orage épouvantable nous a fatale-
« ment condamnés à l'inaction cette nuit;
« mais il a aussi empêché nos ennemis
« d'exécuter leurs desseins perfides.

« La princesse de Beira est chez Ganich.

« Dans quelques heures, l'un et l'autre se-
« ront en notre pouvoir.

« Soldats, vous ne faillirez pas à votre
« devoir; songez que du haut de ces Pyré-
« nées quarante siècles vous contem-
« plent ! » (1)

Eta, bekokitsu egin duen Napoleondar lanaz, gure kapitaiñ gaizua hampatzen da ustez yadanik eskuan daukala lotu behar duen erregiña. Oihu egiten dio bertze gelan lo daguen bere azpiko bati eta ematen dio

(1) « Soldaruak,
« Zerua yeloskor zen gure armen ohoriaz.
« Galerna ikharagarri batek alfer iduki gaitu
« gau huntan; baiñan haren errebiak baratu ditu
« gure etsayak ere bere chede gaichtuetan.
« Beirako printsesa Ganichen etchian da. Zem-
« beit orenen buruan, bat eta bertzia eroriko dire
« gure galtzarrerat.
« Soldaruak, betheko duzue zuen egimbidia.
« Orhoit zaitezte mendi horien goratik berrogoi
« mende zueri beha dagozila ! »

eskribatu duen erantzutia, manatuz beriala itza dezala Makayako Eliza athian.

Noizpeit argi urratzian, atabalak hasten dire, eta yende guzia, atzartua ohigabeko harrabots goiztiar hartaz, biltzen da erresakan plazarat.

Guziak espantituak dire kapitaiñaren eguneko erantzutiaz. — « Horra egiazko « frantsesa ! » diote alde guzietarik. Errientak eskribuz ezartzen du bere paperetan, haurreri irakasteko ordu denian nola behar den azpikueri mintzatu gerthakari handietan. Soldaruak, erran gabe dua, sutan dire.

Bizkitartian, eskaldun bihotzdun guziak hersturan ziren. — « Zer egiñen du Ganichek, zer billakatu behar da? » zioten batzuek bertzeri, « Ganich, gure herritarra, « gure laguna, gure adichkidia ! Nola gan « mehatchatzen duen hirriskuaren hari « mezutzerat? Gauza ez'in egiña da : herri « guzia bayonetez inguratua da; laguntza « ekhartzeko igurikimenik gabe, hartuak « gintazke. »

Laster aditzen da kapitaiñaren boza :

— « En avant, pas accéléré, *arrrche!* » dio Burrumba kapitaiñak, gerlari ozarren espantuan. Atabala eta turruta soiñuz abiatzen dire soldaruak. Norbaitek usteko du, behar bada, etzela zuhurtzia handia, holako mementuan, horren-bertze harrabotsekin soldaruen bidian ematia Baditake, baiñan orhoit gaiten kapitaiña segur zela bere urratsaz. Erregiñaren ihesia ahal guziez gorago zaukan; zelaya ur lodiz estalia zen; Ur-handi egiña ibai laster ez in bertze-alderatuzko.

Soldaruek plazatik ilkhi orduko, atzematen dituzte metaka hirrisku eta trabak. Bide guziak galdu dire, hekien tokian ez da gelditu zillo eta putzu, ur eta lohiz gainditurik baizik. Soldaruek basate hortan ez dakite zer egiñ ez norat itzulika : batzuek sartzen dire putzutan belaunetaraiño; bertziak arbola erorien errotan behaztupatuz lurrerat duazin trumbilka. Ehun oihu, arnegu, madarizione, herrian nihoiz ez adituak, orrotan entzuten dire urrunerat.

Hargatik, Burrumba kapitaiñak ez du burua galtzen :

— « Aintziñat, haurrak ; hau ez da « deus ! » dio ihurtzuriaren bozarekin « aintziñat ! »

Eta frantsesen furia ezin baratua baita, soldaruek bide egiten dute intheri trebes, bentzutuz traba guziak.

Urrunian agertzen da Ganichen etche churi eta humilla, bortchaz hartu behar den zitadela ikharagarria.

Azkeneko harat heltzen dire. Zembeit soldaru han hemenka egorriak dire etcheko athe-leihuen zaintzerat, bertziak ezarriak guduko lerrotan.

Begi guziak harmatuak dire leiho eta zirritu bakhotchari buruz. Pirpiran igurikitzen dute !

Ordu latza da !... Burrumba kapitaiñak aintziñerat zembeit urrats egiñez oihuz dio :

— « Legiaren izenian eta Frantziako er-« regeren phartez, Beirako printsesa, har-

« tzen zaitugu. Geldirik zaude : alfer baiti-
« tutzu entsegu guziak ! »

Ordu berian, bazterrak iñarrusten ditu chispa kolpen harrabotsak, eta mendiko oihartzunek atzartzen ohigabeko patarrakek. Halere ez da ageri deusik erran ez higitu dela etchian.

Aintzindaria, asaldatua ikusiz gogorrarena egiten diotela haren manuari, cheharazten ditu athiak. Eta bera sartzen da mayestate handirekin etchian, soldaru guziak ondotik.

Sotuan, nihor ez. Baduazi eskebelethan goiti, nihor ez ! Aldizka irur athe arthikiak dire... nihor ez oraiño !

Oghiak miratuak dire, lastairak itzulipurdikatuak, mahaiñak eta kutchak puchkatuak, chiminietaraiño guziak ikhartuak... deusik ez da ageri !

Bethan, sala handi bat zabaltzen da sethiatzaille harrituen bichtan, eta han ikusten dute mahaiñ bat hedatua, dafaillak

herrestan lurreraiño, gaiñian dituela oraiño zembeit bazkari handiren ondarrak. Han den zillarreriak begiak llilluratzen ditu.

Aintzindaria sartzen da lasterka harat eta altchatzen du eskuz dafaillaren pertail bat... deusik ez! Markha-alasiak porroskatuak dire... deusik, deusik ez!!

Bizkitartian, supasterreko brasa bizitik ageri da berriberritan norbeit etchian bazela.

Kapitaiña burua galtzerat dua, adios asmatu espoleta berria, adios gurutzia! ihes duazko atsegiñekin ferekatu esperantzak!

Kolpez, usaiñ borthitz goldeko yendetan guti ohitu batek baratzen du haren usna.

— « Lagunak, » dio, « usaiñ hori *etherra* « duk! printsesa hor diagu! »

Badua zerratua den azken athe bati buruz; handik heldu zen usaiña.

Hurbilltzen da, bethi bere soldaruak ondotik, eta bere boz lausengarrienarekin:

— « Printsesa, » dio, « dabilkazun usai-
« ñak salatu zaitu, zato, ez gehiago go-
« gorra egiñ ! Idekazu zutarik urruntzen
« gaituen athe hori. »

Baiñan ihardesterik ez du galde berri horrek ere. Kapitaiñak ematen du beharria atheko urrakuetan, eta nolakua ez da haren bozkariua entzutian hango nigar eta auhen illunak !

Ez da gehiago esmesiarik, erregiña hor da !

Emeki yotzen du athia eta hartuz bere boz balakagarriena :

— « Andria, othoi, idekazu bada ; nahiz
« etsayak garen, on eta prestuak gare bi-
« torian. Ez beldurrik izan, zato, frantsesak
« gare guzien buruan. »

Alferretan aintzindari hunek higatu zuen bere mihi leguna. Nigar eta auhenak berratuz zuazin. Orduan, gure gizonak, guzia sumindua, soldaru bati eskuetarik khendu dioen chispaz yo eta lurrerat arthikitzen du zabaltzen etzayoen athia.

Yaun ona ! zer ikusten du !

Haur chume bat, eritasunak ubeldua, sehaskan etzana, eta haren ganat makurtua gizon zahar bat ille zuritan lausengatzen hari zayoena.

Kadira baten gaiñian andre baten zaldizko chapela saihal ferde bat dilindan; lurrian, bidiantien kutcha pullit bat eta ampolla lehertu baten puchkak.

Gizon zaharrak uzkurtasunekin ihardesten du egiñak ziazkon galderi; baiñan azkeneko, idorki manatua mintza dadien, chutitzen da eta kobratuz bere gaztetasuneko balapua : « Billazazue ungi, billa,
« Yaunak; ez da zeren; nahi duzuena ez
« duzue atzemanen; iragan gabian gan
« zen; oraikotz mendiz bertze-alderat hel-
« dua da. »

Hemen, itsuak argitu ziren; ez gaite mintza hango begi eta arphegiez !

## CAPITULU X[na]

---

## AHUKUA

Hillezkillek urrunerat adiarazten dute bere soiñu samina. Martillu tankako idorrek diote bihotz miñaren auhena.

Zertako, ene Yinkua, ni hillaraz?.....

Beriala oihartzunak beretzen ditu soiñu horiek eta, gure buruaren gaiñian handitasunarekin dabillan galernak bezala iduri du erraiten dioela gizonari: « Aditzen duk? « Horra Yinkuaren boza; » orobat izkiritu bihotz erdiragarri horiek, airian luzatuz heldu dire oraiño huni erraiterat: « Ni « mintzo nauk, ni hire yuye bakharra!...

« Apur bat utzi hindudan hire buruaren
« nausi frogatzeko, egun ene ganat hartzen
« haut; bethitik enia hintzen. »

Maiz eta ardura, hillezkilla horiek mezutzen dute ama bat khendua dela bere haurren ferekaduretarik, edo haur bat amaren musuetarik.

Bihotz-miñezko urruntzia zeiñetarat gizonaren arrazoiña ez baititake ohi! Nor da egiñ dezakena, auhenik eta dolamenik gabe, azken adi bat bere bihotzian dituen maitieneri?

Kobra ditake diru edo ontasun galdu bat, bizitze gisa nasai ihes egin bat; baiñan herio latzgarri eta ezin trikatuak yo duena suntsitzen eta desegiten da, ondikotz! gibelerat itzultzerik gabe. Gizona baratzen denian orhoitzapen hortan, beldurrak ekhartzen dio izpiriturat illundura: bere burua utz lezake etsimenerat, baldiñ Yinkuaren orhoitzapena heldu ez balitzayo bethan irakusterat uhartz deskantsagarriak.

Gizonak bestiaren akhabantza bera othe duke, eta harekin nahastatua izanen othe da putzu edo hobi berian ? Bentzutzen du lehoiña, garaitzen otsua, lur huntako bizi den guziak obeditzen dio haren nahiari; heriuak yotzen du : hekien iduriko billakatzen othe da ? Ez, ezen hill onduan oraiño khar ageri ez den batek berechten ditu gizonaren eta bestiaren ariak. Arimak bizitze berri bat hasten du, hiltzerik ez den lekuetan; eta, bihotza nahi gabe handietan, orhoitzapen horrek bakharrik deskantsarazten du. Amak erraiten dio heriuak khendu dioen haurrari : « Berriz ikusiko haut ! »

Zertako loriak, zerentzat hobi baten gaiñian othoitzak ? Hillentzat erraten diren othoitzek eta egiten diren ohorezko gauza guziek, ez othe dute frogatzen bertze bizitze batian dugun sinhestia ? Horrek iraunarazten du orhoitzapenaren sua eta bihotzian finkatzen esperantza.

Gela beltzez aphaindu baten erdian, bi zirio pichtuen artian, horra kacha bat hill-oihalaz estalia; barnian du ama gazte baten gorphutz hilla.

Ahaide eta adichkidiak bihotz-miñetan hurbillduak ziren ama gacho huni azken adien egiterat.

Gizonak kapa-dengadun artharekin aitatik semerat atchikietan ziren; emaztekiak aldiz gorago aiphatu ditugun eliza-bidetan dabilzkaten kaputcha beltzetan.

Heriuak bere sar-illkia egin zuen etche atherat yendiak bilduak zireneko, ethorri ziren bi kaputcha beltz-dun andre haiñ ungi biribillkatuak non ez baitzitaken den gutieneko hekien arphegirik ikus.

Laster, dolamenezko kantak hasten dire; entzunazu harrabots illun hori : gorphutzaren altchatzia da. Auhen eta nigar marraskak zartatzen dire alde guzietarik, eta daramaten kachak, etchetik illkitzian, khentzen diote ahaideri bere azken esperantzen enganiua.

Hillaren ondotik, abiatzen da ahukua ichilltasun handienian; noizetik noizerat aphezak adiaraziz hillak bere azken egoitzarat segitzen dituen kanta mingarriaren zembeit phertsu.

Ahukua zuan bidia harritsua baitzen, bezperako galernak min guti egin zioen; etzuen bertze trabarik han hemenka zembeit ichtill bakhan beizik.

Bi kaputcha-dun azken ethorriak bazuazin soiñez-soiñ, noizetik noizerat zerbeit elkharri erranez.

— « Zer kuraya ! » zioen batek « galer-
« naren elementan billatu du ene ihes-le-
« kurateko bidia; zeiñ bihotz oneko gizo-
« na ! Yinkuak sarista dezala ! »

— « Nor da zuri estekatuko ez litekena ?
« Nork ez letzazke ahal guziak egiñ zure la-
« guntzeko ? » zioen bertze kaputchadunak.

— « Gure etsai atzarrien engañatzeko,
« othe zitaken asmu hobiagorik ene hunat
« doluko arropetan bidaltzia baiño ? » ze-

rasan printsesak (ezen hura zen mintzo zena); « zuk dakizun gorde-lekutik urrun « gare ? ezagutzen othe duzu ungi harat « daramakan bidia ? »

— « Ez izan beldurrik, andria, » dio Rafaelak, « Ganichek niri gomendatu zaitu, « fida zaite niri. »

Ordu berian, Burrumbaren soldaruen chispa kolpek iñarrusten dute mendia.

— « Yinko handia ! zer da harrabots « hori ? iduri du tirokan hari direla. »

— « Deusik ez da hori; soldaruek behar « bada sethiatzen dute anayaren etchia, « baiñan han atzemanen dituzten haur eri « eta gizon zaharra gerizatuko ditu bere « flakeziak berak. Ez diote soldaruek mi- « ñik egiñen. »

— « Aditzen ditutzu oihu eta paturri « horiek ? segurki soldaruek yarrekiko « naute... Barkha othe nazakete zeren ihes « egin diotedan ? »

— « Urrunchko dire, urrun, gure ga-

« nik; etzayote gogorat ethorriko ere he-
« men zarela. »

— « Baiñan, ikustiarekin ene gelako « nahasmahasia, ezagutuko dute aise ez « naizela urrun. »

— « Billatuko zaituzte auzoko etchetan « eta han geldituko dire. »

Itzulian, mendi bizkarra behera yautsi eta, ahukua sartu zen Ur-handik bere ibai nahasiak lasterka zabilzkan zelayan. Hurbillduago eta, ur haren harrabotsa bortitzago aditzen zen.

— « Ibai hori haserrezko iduritzen zait, » dio erregiñak. « Nola gan bertze-alderat? »

— « Etzaitezela lotsa, andria; Ganich « trufatzen da hirriskuez, salbo eremanen « zaitu ur alde batetik bertze. »

— « Nahi edo ez, ez naiz beldurraren « nausi, » dio printsesak; « hill hori, ahuku « hau, nigar eta doluko arropa hauk ikha- « ratzen naute. A! Yinkua, indazu behar « dudan kuraya. »

— « Ez izi, andria, ez; iragan gabian
« bertze hirriskutan ibilliak gare : orduan
« gutiago beldur ziñen; eta, orai, salba-
« menduko porturat heltzian, hirrisku han-
« dienak abantzu bentzutu onduan izitzen
« zare? Izan zazu beraz, andria, Yinkua bai-
« than fidantzia gehiago. »

Gure bi solastiarrak ahukuko yendien ondotik urrun zabiltzalakotz, elkharren artian mintza zitazken nihork aditu gabe. Holako biltzarrietan, bereziki gure herrietan, bidia luze luzia denian, yendiak elkharretarik urruntzen dire; bat bedera mintzatzen ere bere lagunekin; ahaidiak bakharrik ichillik dagozi; egiazko bihotz-miñak elhe guti baitu.

Bizkitartian, Ur-handirat hurbillduak ziren, eta ibaya itzaltzen zuten arbola, hesi eta etchiak emeki emeki gibelerat utziak ziren ahukuarrez.

Itzulika bat-bertzien gaiñetik trumbillka zuazin uren harrabotsa gero eta gehiago

latzgarritzen hari zen. Itsas marloin churi eta potorro, ur gaindituetarat lehiatuak, hegaldaka zabilltzan ur hegi batetik bertze. Ageri ziren behiñ ur-perat sartzen, gero gaiñeratzen, berriz pulumpatzen eta azkenian airetan abiatzen.

Ahuku ethendua baratzen da, hats hartzeko. Kacha lurrian pausatu dute eta ahaidiek inguratzen marraska berrietan. Emeki emeki oste barraiatua bateratzen da; kapa eta kaputcha beltzak elkharren ganat hurbilltzen dire eta multzokatzen. Ikustekua zen eta bihotz mingarria hill ohatze hura galernak gabaz sakaillatu zelayan.

— « Baiñan non othe gare bada? » galdetzen dio printsesak Rafaelari beharrirat.

— » Zaude ichillik, ichillik othoi, an-
« dria; ez gare gehiago bakharrik biak;
« den gutieneko hitzak gal gaitzazke; ungi
« dire guziak...

« Beira, ikusazu non den? »

Ordu berian, hesi artetik, printsesak eta haren lagunak Ganichen begia ikusi eta, berriz esperanza sortzen zayo erregiñaren bihotzian.

---

## CAPITULU XIna

---

### ARROKA-ZILLOKO SOLASAK

Zerua liraiñ zen eta iduzkiak ichuriz bere ungi bizi nasaiak ostraill pian dichtiarazten zituen ur chortak harri bizi begiak bezala. Choriak alde guzietan kantu errepikaz hari ziren. Haize eztiaren hatsak doidoia higituz chuchturrak ehun argi begitan zabilzkioten gaiñeko ihintza. Ur ibaikatua orruaz zuan zelaya behera. Ur-handiren gaya lohituak olatuak olatuari ihesi zuazin, arrapo horiak hedatuz bazterreko haltzetarat, iduri arthalde otsuen beldurrak nahasi bateko ardi barrayatuak, basatian galduz bere illien churitasuna.

Hill-ahuku, pausatzen gelditua, beira zaguen aphezak keiñu egin zezan, abiatzeko. Zer itzal illun eta dolugarria, ahuku hori, goiz eder hartan, naturalezari alegrantzia eta bizia orotarik zarioenian !

Orduan, kaputcha-dun andretarik bat, baratche baratche, ahukutik bazterreratu zen hurbilldu Ganich gordia zaguen hesiari buruz.

— « Ni naiz, » dio printsesak ahopian mintzatuz.

— « Zato, andria, othoi fite, » dio boz ungi ezagutu batek ; « eremanen zaitut leku « segurrerat : zure gorde lekua hemen hurbill da. »

Eta Ganichek, esku emanez printsesari itzalarazten du charan barna eta yaustarazten belar handi eta hunts-ostuez sar-hiria gordia zuen arroka zillo baterat. Lamiategi horrek hare chehez zuen ondua ; han ere printsesak kausitu zituen yateko zerbeit lurrezko alkhi baten gaiñian.

— « Hemen orai segurian zare, andria, » dio Ganichek; « Rafaela eta nitaz landa, « nihork ez daki leku hunen berri. Gayak « laster aphalduko dire; heyen gora-behe- « rak aspaldi ezagutzen ditut. Beira, yadan « ura garbitzen da, itsasoko ihizkiak ihesi « gan dire, eñadak gora dabiltza, berri « ona. Zerua dichtiant da eta Espaiñia hor « da zure aintziñian ! horra non ditutzun « hango mendiak ! »

— « Yinkuak dautzula, horren bertze « hirriskutan enegatik ibilli zaren gizona ! « Miresten zaitut ; sortu ziñen errege izateko, « eta baldiñ zeruak hala sorrarazi bazintu « gauza handiak egiñen zintuen. »

— « Ni errege ! zer bitchikeria ! »

— « Irriz zaude, baiñan emagun apur « bat errege zarela : yakin nahi nuke zer « egiñ ziñezaken. Hots, errazu laiñoki. He- « men gare sarri arte, mintza gaiten : ira- « ganen zaiku dembora, ahantzaraziz ingu- « ratzen nauten hirriskuak. »

— « Zer nahi duzu, andria? Yakitaterik
« gabia naiz; zer erran dezaket?

« Halere, errege banintz, iduri zait ez
« nukela nahi behiñere nihor pairatzen
« ikusi; urrikari ditut bihotz guziz yasaten
« dutenak. Zuk, andria, ez dakizu zer den
« egiazko pairamena, egiazko beharra. Huna
« aita bat, bere familiaren laguntza bak-
« harra, eri, lastuan etzana, pillik gabe, bere
« haur hamikatuen erdian; horra ama gai-
« cho bat: haurrak billuziak ditu, zembeit
« piltzar ez-deus beizik, ez, heyen gor-
« phutz hotzak ikharatuen estaltzeko.

« Errege banintz, andria, nehorrek billa
« netzake erromesak, heyen hobeki lagun-
« tzeko; gan nintake beharraren etcholarat
« hari eskas dituen ogi eta arropen ema-
« teko; lagun nezake, bakharrik beharrian
« delakotz, galdetu gabe yudu ala katholi-
« ko, karlista edo kristiño den. »

— « Bihotz ona duzu, hori ederki litake;
« baiñan nola egiñ ziñezake, zer bide har,

« erromesiaren gizonen artetik desterra-
« tzeko ? »

— « Banuke dirutze berechi bat, bere « bizia irabaz ez dezaketen beharrentzat. « Lana eman niozokete osasun eta beso « oneko guzieri, erran gabe : hunek gaizkia « egiñ du, preso izatu da, ez dut nahi ho- « lako langillerik. Contrarat, har nezake « zeren, goiz edo berant, lanak gizona « prestu eta untzen baitu. »

— « Baiñan, badire ospitale eta sokor- « rizko ihes-lekuak zorigaitzian direnen- « tzat. »

— « Egia da, andria, baiñan hiritarren- « tzat bakharrik eta ez arrotzentzat, ezen « basherritarra ez ditake han sar, ez bada « eremana beso edo zango hautsien anto- « latzaillien billa. »

— « Ez othe ditake bada, basherrietan, « hirietan bezala egiñ ? »

— « Ai ! andria, eta non kausi horta- « rakotz behar dirua ? Hiriak iresten ditu

« gure ontasunak; milliundunak ez dire
« egoten gure artian. »

— « Zer bada, ez da hirietan aterperik
« basherrietako beharrentzat? »

— « Bai, andria, naski; baiñan pagatuz
« eta nola paga dezake pobriak? a ochala!
« hirietako ospitale eta geriziak ez balire
« yauregi egiñak, haimbertze edergaillu
« alferrez berreginduak, ez litake pobreri
« dirurik galdetu behar bereri sokorri ema-
« teko.

« Eder zaizkit eta onhesten ditut herriko
« loriarentzat eta gizon ozpatuez orhoita-
« razteko egiten diren obra miragarriak,
« zer nahi ere gosta diren; ezen hola ema-
« ten da lana langilleri eta gauza ederren
« primantza egortzen ethorkiko mendieri.
« Baiñan eme-churtcha, ezindu zahar eta
« erien aterpeak nahi nituzke humillago eta
« edergaillu gutiaguarekin ikusi.

« Badakizu zertako diren hirietan ospi-
« taliak deitzen dituzten yauregi hek? Mai-

« zenik, arlotekeria, bizio eta ergelkerien
« kurayeztatzeko. Batbederak dio hek ikus-
« tian : yosta gaiten eta alegera, orai, gazte
« gareño; ez gaiten orhoit biharamunaz;
« zahartzen bagare, horra gure etchia, hor-
« rat ganen gare; hor, bizi gochuan, ira-
« ganen ditugu gure azken egunak, do-
« hatsu errege bezala. »

— « Atsegiñ dut zure hola mintzatzen
« aditziaz, eta haiñitz gustatzen zaizkit zure
« hitzak. Gerochiago, behar orduan, orhoi-
« tuko naiz zure kontseilu onez. Baiñan
« errazu, zer egiñ ziñezake oraiño, errege
« baziñe ? »

— « Ene laguntza eta artha berezienak
« nituzke ospitaletako serorentzat : hek bi-
« zia higatzen dute beharrian eta miñetan
« direnen sokoritzen. »

— « Oi ! zembat maite eta miresten di-
« tudan emazte seindu eta ozpatu hoyek ! »
dio erregiñak, « seguratzen zaitut ez ditu-
« dala sekulan ahantziko. »

Ederra zen egiazki Ganich, bere bihotz onaz, izpiritua argitua, printsesari mintzo zitzayoenian hola, ospitaletako serora, aingiru contsolagarriaz !

Hura da Yinkuaren eta gizonaren arteko lokharria.

Entzunazu heriuak haurraz gabetu behar duen sehaskaren aldian mintzo den boz amultsu eta urrikaldun hori : « Gaicho « haurra, » dio, « Yinkuak beretzat nahi « zintuen, baiñan ene orhoitzapena zure- « kin hegaldatuko da aingeruen herrirat ! »

Sarri, emazteki amultsu hura soldaru ausarten bihotzarekin, ikusiko duzu, heriuari buruz, hirrisku guzien erditik, suan diren gerlarieri kuraya ematen, eta kolpatuen sokorritzen. Guduaren khean galdu dire zerua eta lurra. Peza kolpen ihurtzurian ikharan dago zangopia, eta, han hemenka, hedoian saltatzen dire chimisten pareko su latzgarriak. « Hots, haurrak, « hots, kuraye! » oihu du serorak, « Yinkua

« lekuko guduan zaizte : hemendik ere bada « zerurat bidia ! Hots kuraye ! Nik ere ba- « nakike zuek bezala bizia ematen; bai- « ñan, Yinkuak uzten banau bizia, egonen « naiz zuen aldian, zuen zaurien ene eskuz « arthatzeko. »

Ikuspen lotsagarria ! lurra estaltzen du hiltzera duazin zaurtuen ostiak, oihu eta marraskak bazter guzietan.

« Non zaizte, » dio serorak, « non zaizte, « gaicho dolugarri miñetan hondatuak? He- « men naiz heldu zuen miñen eztitzerat « ene erremediuek sendatzen ahal ez ba- « zaituzte, egiñen dugu elkharrekin othoitz. « Bihotz-dun eroriak, horra zerua zuentzat « zabaldua ! » Eta serora sokorritzailliak, belauniko makurtua balek sakaillatu gorphutzari buruz, here boz ezti eta behatze zerutiarraz ichurtzen dio, hiltzera duanari, arimarat, esperantzaren argi gozua.

Bizkitartian, maiz serora hori da bere aita-amen haur maiñaz galdua. Hautsiz

łokharri miñenak, hek utzirik, badua herri arrotz urrunenetarat. Salbayek berek miresten dute. Mundu guzia, horra haren herria; ez du bertze ahaiderik.

Ama bat, bere etche hustuaren azken ondarra, nigarrez eta auhenetan da, bere azken ohatzian, bakharrik gełditua, lagun amultsurik gabe; haur eri gaicho bat, paturriaka, galdu duen amari oihuz; gizon gazte bat adiñaren suak bide tzarretarat arthikia, erori da zaurtua bere hutsek, illunik dago biziaż etsitua; neskatcha gazte bat, beharrak lerrarazi duena tzarkeriarat, higuñgarri billakatu da bere buruarentzat, guziek ihesi diote; gizon bat zahartua bera bakharrik gelditu da lurrarren gaiñian, bihotza zaurtua gałdu dituen ahaide eta haurren orhoitzapenak, harentzat biziak ez du oiñhatzerik beizik; Yinkuaren ukhatzaillia, ikusiz oiñen azpian lurra itzurtzen zayola, yo duen miñaren eztenaz atzarria, azken orenian, ahuan arrapua, arneguz eta blasfemiaz dago.

Baiñan huna non agertzen den zeruko aingerua. Kolpez, ama nigarretan urtuak, eme-churtcha alde bat utziak, gizon gazte etsituak, neskatcha gazte lagunek utziak, gizon zahar bakharrik geldituak ikhusten dute esperantzaren argia bihotzetan sortzen. Nigarrak agortzen dire, eta igurikimen gozua sartzen etsimenaren illundurek hartu tokietan. Siñheste-gabia bera ahalkatzen da bere arneguez eta ahupaldi gaichtuez; eta hastiatzen hasten bere iragan egunen.

Erran dugun serora bera da, zerutik yautsi aingeru, mirakullu horren egillia.

Badire marmolaz eta altzairuz mendetako gerlari eta gizon aiphatuen lekukuak. Baiñan zuentzat, ô emazte paregabiak, loria handienian, lore eta koro deusek, nihoiz, histuko ez dituenak !

Apur bat printsesa ichillik goguetan baratu zen, begiak itzuliak bere bihotzak galde zioen Españia alderat. Uren orrua etzen

oraiño gelditua; tiraiñak borroka zabiltzan oraiño hasaldatuak. Etzitaken bertze alderat abia; behar zen iguriki. Apur baten buruan, Ganichen ganat itzuliz :

« Solas hautuak ditutzu,» dio printsesak, « nondik dakizkitzu erran nauzkitzun gauza « on eta zuhur horiek ? »

— « Erran zaitut yadanik, andria, yakitaterik ez dudala; baiñan, ene biayetan, « zembeit ikusi eta ikasi dut beharraren « eskolan. Basherrietan biziz, badazkitzat « inguruko eskasen berriak. »

— « Zer egiñ ziñezake beraz zure bas- « herrietan, errege baziñe ? »

— « Ahal guziaz laguntza eman niozokete laborarieri. Banuke hortarakotz di- « rutze on bat; etcheko yaun bakhotchak, « bere ontasunen araberako, behar orduetan, hartarik baluke berriz bihurtzekotan. « Hirian eta plazan, oihal, gatz eta piper « saltzailliek badute prestamuz behar duten dirua. Zertako laborariak ez ditu er-

« rechtasun berak? Tratulari eta ofiziale
« gehienek non nahi kausitzen ohi dute be-
« har dituzten urhe eta zillarrak: zertako
« laborariak ez lezake orobat kausi gauza
« bera, bere etche eta landak *ipotekan* eman
« gabe. Lur erabiltzailliek, errekarat dara-
« maten contratuz, hainitz gostaz beizik, ez
« in diote aurki den gutieneko dirua. »

— « Arras ungi mintzo zare; baiñan
« nola egiñ nahi zindukena? »

— « Nola egiñ, andria? iduritzen zait
« erregerentzat guziak errech direla. »

— « Ez bethi; baiñan, errazu, zer egiñ
« ziñezake oraiño? »

— « Zer erranen dut, andria? gutia da
« nik dakidana. Hargatik, errege banintz,
« lausengariek mehe egiñ lezakete enekin:
« guti fida bainintake korteko mihi legun
« berekoyeri, ezen hek egia gordetuz prin-
« tzeri, ekhartzen dituzte guzien kaltiak, eta
« egortzen erregiak eta erresumak erreka-
« rat errozgora.

« Korteko lausengariak, hala edo ez, be-
« thi arrazoiñ ematen diote printzeri, bel-
« durrez heyen adichkidetasuna gal. Nik ez
« dut maite lausengariak; nahiago ditut
« eniak entzun, zeren, egia adituz, ikasten
« baitut ungi egiten. »

— « Baiñan egiazki erran litake orai arte
« kortian higatu zarela. Errazu bada, er-
« rege baziñe, etzintuzke nahi gerlak egiñ,
« armada ederrak manatu eta bitoriak ere-
« man ? »

— « Ez dut gerla maite, andria, eta er-
« rege banintz, bethi bakia billa nezake.
« Gerlak gizonak iresten ditu, herriak
« husten eta lurra langillez gabetzen, griña
« eta bihotz-miñak hedatzen bazter guzie-
« tan »

— « Bizkitartian gerlari darraizko ohore
« handi nahikarakuak; soldarua billaka bai-
« titake yenerale, marechale, minichtro... »

— « Hoyek denak on dira, andria, gi-
« zon eskolatuentzat; baiñan gu bezalakua

« mando gan gerlarat mando gerlatik itzul. »

— « Halere batzuetan gerla egin be-
« har da !. »

— « Badakit, andria, bai, behar dela
« batzuetan auzuekin borrokan hari, bai-
« ñan, hillka hasi gabe, behar litazke ahal
« guziak egiñ elkharren aditzeko eta bazter-
« rerat utzi urgulluaren contseilluak. »

— « Baketiarra zare beraz arras ? »

— « Bai, andria; bakiari darraizko on-
« dorio hoberenak. Hari esker, kurayezta
« netzake lan eta egintza ederrak, bereziki
« lagunt laborantza, heda sal-erosiak, eta
« elkharretarik urrun diren yendien artian
« eman aria berriak. Hola gauzak ungi gan
« litazke eta bakiaz balia nintake zergen gu-
« titzeko; errech bailitake, soldaru gutiago
« izanez pagatzeko, bolbora gutiago erretze-
« ko, yaun handi gutiago sariztatzeko, alar-
« gun eta kolpatu gutiago sokorritzeko. »

— « Egiazki, bakiaren itzalian, gauza
« handiak egiñ ditazke; ez othe litazke ere
« eskolak berra ? »

— « Bai, andria; baiñan nahi nuke bakhotchak lehenik ungi ikas dezan bere erliyonia, ezen Yinkuaren maithatzen eta errespetatzen ikasiz, ikasten da ere aita-amen amodiua eta errespetua, laiduen ahantzia, amoiña emaitia, ihes egitia leku tzar eta ostatu gazteriaren ohikuntza tzarren ithurrietarik.

« Nahi nuke oraiño, gure herrrietan, haurrek ikas balituzte handitu eta hartuko duten ofiziuari duazkon gauzak. On litake, naski, guziek yakin dezaten irakurtzen eta eskribatzen, baiñan, guzien gaiñetik, hautaraz netzazke laborari eta baratzezaiñek baitezpada yakiñ beharren irakasteko gai litazken errientak. Eskola-emailiak behar liokete laborari semeri irakatsi nola behar den lurra erabilli, eta nolako eragintzak behar diren egiñ toki bakhotchian.

« Bizkitartian, ene arabera, behar litazke lagundu, eta kurayeztatu, Yinkuak bere dohaiñ bereziez berregindu dituen gizo-

« nak. Badire gure artian artzaiñak berak,
« phertsulari sortuak, bai eta ere nihongo
« eskolan ibilli gabe yaun erretorak baizin
« ederki predikatzen dakitenak. Ikusi ditut
« nihongo chifrazaille hoberenak baiño las-
« terrago buruz kontu atheratzen zakiten
« ikazkiñak. Ezagutzen ditut bere baitharik,
« miriku hoberenak baizin ungi, zango eta
« beso hautsien antolatzen zakiten zapatai-
« ñak. Badire belarren izenak yakiñ gabe, he-
« kien indar sendagarriez baliatzen dakiten
« hargiñak. Ezagutzen dut norbeit, errien-
« tik gabe, haritz edo ametz, herri, bestia eta
« yendien itchurak gogorat egiten dituen
« illagiña. Badakit ere non den ehaille bat
« zeruko izar guzien itzulikak gogoz dakiz-
« kiena, eta gabaz, noiz nahi, hetarik orenak
« chuchen; galdetzen bazayo non zen
« atzo edo yaz, non ditaken bihar edo
« hilabethien buruan, hunelako edo halako
« izarra, behaztuparik gabe, erhiz, noiz nahi,
« zeruan, tokia irakutsiko duena. Non nahi

« badire laborari eta arotch oren eta mun-
« tra antolatzailliak, lan horietako tresna
« ez langillerik egundaiño ikusi gabe. Non
« dire gure oihanzaiñen pareko kantariak?

« Hola beraz, nahi nuke holako gizonak
« ezagutuak balire hekien azturak lagun
« detzazketenez. »

— « Arrazoiñ duzu, bekhatu da bar-
« nian geldi daiten gordiak, laguntza eska-
« sian, Yinkuak holako dohaiñ espantagar-
« riez aberastu gizonak. Yinkuak ungi
« maite ditu herri hauk, bere dohaiñak
« horren nasaiki hemen eragiteko. Chora-
« tua naiz bidian ikusi ditudan bazter mi-
« ragarriez. »

— « Siñhesten dut, andria; munduko
« toki ederrenetan bizi gare; eta iduritzen
« zait Yinkua bera berriz lurrerat yausten
« balitz, hemen bere egoitza hauta leza-
« kela. »

Eskal-herria ikusi dutenetarik nihork ez

du irri egiñen Ganichek bere sor lekuaz eta haren inguru eder eta aberatsez duen espantuaz. Nor ibilli othe da, choratua izan gabe, hango mendi eta panttupa ferdegailluz aphainduetan, hango phenze fresko irriz dauden lorez estalietan ? Nor ez da atsegiñekin baratu Ur-handiren bazterreko zelaichka gozuan, Kamboko ur-on epheletan ? Kambo, ibayari buruz yarria, hurbilleko patarrian, nor gare gu : nork ez ditu hire bide eta yar-lekutan ahantzi hiriko griña eta kechadurak ?

Baiñan gauza guti zor diote laphurdiko itsas bazterrek hango mendien edertasunari. Donibane eta Miarritzeko itsas hegiak guzien gaiñetik ikustekuak eta maitagarriak dire. Hortarakotz, urthe guziz, Miarritzek biltzen ditu nihongo dirudun handi, gazteria eder atseginkariak; han ere yostetan bateratzen dire koplari eta legeemailliak, gerlari eta yakiñak, printze eta dantzariak.

Donibanek, haro gutiagorekin, bereganatzen ditu atsegiñ eztien billa harrabotsetik urrun dabiltzan zuhurrak edo erho unhatuak; han ere bakia eta osasuna kausitzen besagainka dirua arthik ezin duten arteko yendiak, Miarritzen behar bezala.

Badire gure itsas-hegietan bertze leku arrotzek ikustia merezi luketenak, bai eta ere zembeit gizon baketiar deskantsatzeko udan billa ditazkenak; aiphatuak dire hortako Guetharia eta Hendayako itsas bazterrak.

Baiñan neguko galernen egunian ikus baziñetza udan haiñ eder eta maitagarriak diren kosta hoyek... harri eta ikhara zintazke.

Nolako eta zer gauza miñgarriak ez dire batzuetan gerthatzen bereziki Donibaneko bayan?... Baiñan laster, Imperadoriari esker, gerizezko harrisiak uretik sortuko dire, Zokuatik Artako arrokaraiño eta ihesleku on egiñen galzapenian heldu diren untzi eta mariñeleri.

Gizonak ethorkiari utz detzaken obra eder eta laudagarrienak ez dire atsegiñ eta urgulluarentzat altchatzen dituenak, baiñan bai beharrian direnen laguntzeko eta hirriskutan yende bizien sokorritzeko egiten dituenak. Hek chutik daudeño azkar daukate ondokuen bihotzetan egiazko ungi egiñen orhoitzapen ezin hilla.

Yakiteko zer ezagutza merezi duten Donibaneko lanek, ikusi behar litazke eskal herriko kostak itsasua asaldatua denian errebian, eta bereziki Donibaneko bayan.

Yinko handia, zer gauza ikharagarria !

Zerua, lurra eta itsasua, bat egiñak nahasduran, galdu dire, estaliak, marrumaz itzulikan, arrapua darioten tiraiñ hiratuez.

Zokua, Santa-Barbara eta Arta, batian gainditzen ditu zeruraiño altchatu itsasuak ; doidoian, noizian behinka, non diren agertzerat uzten dituela gaya lehertuak : iduri itsas hasarria hondatzerat duan gaicho mariñelen hobia.

Donibane guzia auhenetan dago; nigar eta deiadarrak karriketan; emaztekiak burukorik gabe illiak dilindan, haurrak marraskaz, lasterka orotarik, erhuak iduri baduazi itsaso bazterrerat. Aphezak ere, elizako arropetan, ilkhiak dire othoitzez zeru hasarretuari buruz.

Zembeit gizon, burua galdu ez dutenak, ikharazko oren hortan, bateratu dire elkhar laguntzeko itsasuak iresterat duazkon dohakaberi esku emateko, nolazpeit heyen leihorrerat heriuaren aztaparretarik khentzeko. Orduan galerna, ifernuzko itsaso hortan, trufatzen da gizonen hari buru egiteko permagune erbalez: errayik ez dute tiraiñek; itsaso achola gabiak ez du entzuten ez nigarrik ez othoitzik; zer duazko haurren bihotzmiñak, ama eta alargunen etsimenak?

Laster itsaso barne nahasiak goitika han hemen, arthikitzen ditu iretsi dituen gizonen gorphutz hillak.

Gaicho amak !
Gaicho haurrak ! !

. . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . .

Betbetan, aditzen da urrats bat, leze bazterrian, chuchturrak higitzen dire. Ordu berian, iru esku yotze aphal aditzen dire leziaren sarreran.

— « A Yauna ! hartuak gare ! » dio erregiñak.

— « Etzaitela izi, andria, » dio lagunak, « ez da deusik ; arrebak eskuak yotzen ditu, « nik erran bezala, hura dela errateko ; » eta Ganichek hitz hauk erratian, printsesak aditzen du beldur guziak khentzen diotzan ezagutu boz ezti bat.

— « Ni naiz, » dio Rafaelak, lamiategian yausten delarik.

— « Ungi ethorri, Rafaela ; atsegin handi « dut zure ikustiaz. »

— « Gordeka hunat itzuri naiz urtchin- « cha bat bezala, nihork ikusi gabe. . .

« baiñan ez ahal zare guti unhatu, andria,
« lamia zillo hortan. »

— « Ez bada haimbertze; zure anaya-
« ren solasek ez naute utzi unhatzerat, eta
« hola dembora gan zait laster, zu ethorri
« arte. »

— « Beldur naiz beharko duzula apur
« bat oraiño iguriki. »

— « Zertako hori? urak ez dire bada
« aphaldu, gayak ematu? »

— « Ez beldurrik izan, andria; banua
« Ur-handiren ikusterat; uste dut laster
« hari nausituko garela. Zaude Rafaelare-
« kin, plazer baduzu, ni ethorri arte. »

Ganich inguru behatu eta nihork ikusten othe duen, ilkhitzen da lamiategitik eta aphalduz, haltzen artetik hurbilltzen ur hegirat.

Ibaya hertsiena zen tokirat heldu eta Ganichek beiratzen du ur zolarat.

Ageri othe diren alde batetik bertze maiz saltoka iragan dituen arroka muturrak;

nahiz aphalduak, urak oraiño handi ziren eta ez garbituak, laster yausten. Arras nekez eta hirrisku handirekin beizik etzitaken bertze alderat abia. Baiñan gure menditarrak etzaukan zuhurtzia gehiago printsesa zen tokian egotia. Soldaru eta gardak oraindik sarrirat yauts zitazken zelayerat eta bidian traba yar erregiñaren ihesiari. Ganichek orduan, Yinkua baithan zuen fidantziaz sustatua, dio bere buruari : « Behar « da, gazin bertze alderat. » Eta ikhusirik nihor ez dela han hetan ageri, badua kuchian printsesa ganat. Eta itchura alegeraz gordetuz bihotzian duen herabia :

— « Hots ! andria, » dio, « abia gaiten : « Baguazke. »

Eta handik lekhora, erregiña eta Ganich baduazi ur bazterrerat.

---

## CAPITULU XIIna

---

### IBAYAZ BERTZE-ALDERATZIA

Eskaldunak siñheste handitakuak dire, zeren baitute fede oso bat othoitzaren indarrian.

Gabaren illumpiari yarreki zaio goiz pirrinttaren argia; mendiaren gorena doidoia estaltzen da itchura churistez. Argi ezkillak yo du. Eskaldunak yauzi egiten du bere ohetik eta gurutziaren seiñalia egiñik erraten du bere goizeko othoitza.

Eguberdi da. Ikusazu gizon hori makurtua bere golde nabarren gaiñerat eta nola yarrekitzen den neke handirekin aintziñian

idekitzen duen ildaskari. Ezkillak yotzen du : beriala languillia gelditzen da gurutziaren seiñalia egiteko eta bere othoitzaren errateko.

Arratsa da. Iduzkia sartu ez bai han da, oraiño haren azken argiak hedatzen dire zelaian. Haritz baten onduan yarria, gizon gazte bat, bere maitiaren aldian, gochoki elheketan dago hari erraten zein berant heldu den bat bertziarenã biak bat egiñ behar dituen orena. Yarria bere etcheko athian, ama gazte batek altzuan dauka bere haur sortu berria : hunentzat ditu bere irri eztiak, hunen loharkatzeko aldizka bere kanta laiño guziak. Anyelus hasten da eta ama eskalduna chutitzen bere haurra besuetan, gelditzen kantatzetik bihotzeko othoitzaren ezpaiñetan erabiltzeko; gizon gazte eta andregeya ere kolpez yeikitzen dire, utziz hitz eztiak, zeruari beira, othoitz egiteko.

Ikusatzu gizon gazte horiek, erhautsezko hedoi batian, birun birun dantzan hari ,

krosketarik gabe erhiz dituzte haren soiñuak, tamburina eta chirula yotzian, batian altchatuz beso eta zanguak, bertzian zoiñ gorago egiñez salto berak irrintziñaka : *mutchikotan* hari dire. Begi on diotela inguru beira diren neskatcheri, hoyek atchikiak baitire : dantzariez baiño artha gehiago dute dantzaz.

Bethan ezkillaren soiñu zillarkarra aditzen da airian, tamburina, chirola eta krosketak ichiltzen dire, yauziak gelditzen, gapheluak burutarik belaunetaraiño yausten, yauzilari bakotchak egiten du gurutziaren seiñalia eta erraten anyelusa.

Merkatu eguna da. Herriko zoko guziak bethiak dire yende tratulariez, bat bertziarekin eskatiman hari dire, begiak zorrotz, mehatchuzko edo dichiduzko ukabilluak egiñez. Ezkillak yotzen du : begitartiak arraitzen dire, besuak erortzen, eta bakhotchak ichiltasunaren eta bildutasunaren erdian othoitz egiten du.

Lehembiziko ANYELUSEN tankakuan, ostatuan diren gizonek makurtuak dauzkaten flaskuak chutik ematen dituzte, basuak ezpaiñetarik urruntzen, erdi bethiak mahaiñ gaiñian uzten.

Pillota plazan haro guziak ichiltzen dire kolpez, eta yokarien esku hantuak izerditan atheratzen eskularruetarik gurutziaren seiñalia egiteko.

Eta guzien bihotz alchatze hortan, norbeitek, gaphelua buruan, irri edo trufa balu, zorigaitz, zorigaitz hari !

Hirrisku batian eskaldunak gurutziaren seiñale batez irakusterat ematen du bethi giristiño dela eta Yinkuaren begitartiaren azpian dabillala. Zerbeit on gerthatzian, Yinkuari orobat eskerrak ditu ichiltasunian, seiñale beraz, egiñ dioen graziaz. Bere egintza chumienetan, irakusten du siñhesten duela, Yinkuaren aiñtziñian dela.

Familiako aitak egiten du gurutziaren seiñalia ogi osuaren gaiñian, zathiturik eman baiño lehen bere haurreri.

Arrats guziez amak egiten du seiñale hori haur sortu berriaren sehaskaren gaiñian. Kandeleroz, chirio benedikatua pichten da eskaldunaren egoitzian, eta chirio horrekin familiako bakhotchak kopetaren gaiñian egiten du gurutziaren seiñalia.

. . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . .

Ibai hegirat heldu zirenian, eskal herriko ohikuntza laudagarriari leihal, Ganich belaunikatzen da eta eskua sartuz Ur-handian, eskaintzen dio bere erhi bustia printsesari.

« Egizu, andria, » dio, « enekin gurutziaren seiñalia eta othoitz, Yinkuak lagunt gaitzan ! »

Hola Yinkua lagun hartu eta, Ganich chutitzen da; ezartzen du erregiña sorbaldetan eta badua saltoz ur lasterrerat. Horra non dabillan urian, harri eta arroka erorieri trebes, deusek ezin baratua, burua gora, ozar garrayatzen duen zama ozpatuaz!

Betbetan, kordokatzen da behaztupa ba-

tian, ezagutzen etzuen zillo berri baten aintziñian. Gorphutz guzia ikharan dardaratzen zayo. Erregiña beldurrak hartua oihuz abiatzen da. Baiñan Ganich, utzirik kordokak, badua yauzi batez lezez bertze-alderat.

Halere, ez dire denak akhabo ibayarekin: iduri du berekin ereman behar dituela oraiño itzurtzerat duazkon ihesilariak. Mende luzien latzgarriko mement batez, etzitaken erran zertarako zen Ganichen gudua ur lasterrarekin. Baiñan azkenekotz, Ganich, uhoiñen nausi, leihorrarazten da eta pausatuz printsesa, erraten dio : « Orai, andria;
« salbo zare, Yinkuari esker. Traba guti
« izanen dugu hemendik aintziñerat gure
« bidian; guti cheletatua da. Gardek baita-
« kite hemen ez dabillala zembeit kontra-
« bandicht atrebitu bakhar beizik. »

## CAPITULU XIIIna

---

# MUGAZ BERTZE-ALDERATZIA

Burrumba kapitaiñak azpizgora eman onduan Ganichen etche guzia, ezin siñhetziz, etcheko yaun zaharraren erranagatik, erregiña ibayaz bertze-alderatu zitakela, engañatua ere Ganichen lagun zembaiten hitzez, uste izan zuen bertze nombeit segurkiago billatu behar zela printsesa, Urhandiren bazterrian baiño. Hortarakotz, bide beraz gibelerat egortzen ditu bere soldaruak eta harat hunat barrayaraziz egortzen hurbilleko etchien miratzerat.

Ibai bazterrian cheletan gelditu garderi

ere, haiñ gora eta haserre ikusiz urak, iduri zitzayoten arima bizirik etzitakela han alde batetik bertze abia, eta hortarakotz ohi baiño gutiago atzarriak zauden.

Horieri guzieri esker, Ganich gan ahal izan zen ibai alde batetik bertze sobra trabatua izan gabe.

Oren erdi bat ibilli onduan, gure ihesilariak yautsi ziren zelaichka hertsi eta aphal baterat. Han sartzian, arroka tarte batetik ilkhiz, ethorri zitzayoten aintziñerat gizon bat, berekin zakharkela, gerrikuaz amarratua, erregiñaren harri bizi eta urreriak barnian zituen gorago aiphatu dugun kopha.

— « Horra haiz, Manuel; ederki hori, » dio Ganichek, « banakikan hiri zaintzerat « emanak ungi zainduak izanen zitukala; « thana hunat, gazin elgarrekin Espaiñia- « rat. » Eta erregiña ganat itzuliz : « Orai, « andria, igan behar gare hemen aintzi- « ñian dugun mendi chut hau gora. Hots!

« kuraye! Bertzela ezin baditake, Manuelek « eta nik sorbaldetan eremanen zaitugu « gaiñeraiño. »

Patarra chorrotcha baitzen eta goroldioz estalia, uriak lerrakor egiña zuen mendi bizkar guzia yendia ezin igan bezalako. Neke handirekin beizik etzitaken hor zango bat bertziaren aintziñerat eman. Arras mendi gaiñerat heldu gabe, erregiñak eta haren lagunek kausitu zuten patar-hegian arroka bat makurtua bertze-alderat zaramakan bidechkari buruz. Arroka hura, erortzerat duan pareta bat iduri, luzatuz zuan bidechkaren ezkerretik. Eskuiñian, ondorik gabeko leze beherian, doidoia ezagun zen, harrieri trebes, itzulika, saltoz, arrapotan yausten ziren uren azantza. Etzitaken gaiñetik harat beha. Behiñ baiño gehiagotan, erregiña, burua nahasi eta bichta galduz, alditchartu zen; behar zen Ganichen kalapu guzia haren aintziñerat ibill arazteko.

— « Hots! andria, kuraye; hots! »

maiz zioen Ganichek, « oraiño zembeit « urrats eta hor da Espaiñia; ez gibelerat « beha: han da gatibotasuna! »

Eta hitz horien onduan, erregiñaren begiak oraiño pichten ziren, eta hartuz berriz kuraya: « Gazin beraz aintziñerat! gazin! » zioen.

Oren luze bat hala ibilli onduan bide tzar beldurgarri hartan, gure ihesilariak heldu ziren elhorriz eta arantzez bethia zen erreka baterat, aintziñian zuten zelayerat zaramakan bide bakharra.

Handik ilkhitzerat zuaziñian, gehiago ez ur laster hertsi bat beizik printsesak iragaiteko, Ganichen arrano begiak ikusi zituen iduzkiak dirdiarazten zituen iratzelekuan zabiltzan garden chispak. Beriala, keiñu egiten diote erregiñari eta Manueli, geldi geldia egon daiten, eta bera aphalduz gordetzen da sasiaren gibelian.

Laster aditzen zituzten garden urratsak; hatsa ahuan ichillik zauden iru bidiantiak,

izituak, bihotzak pampaka bularrak urratzeko menian.

« Zeren ondotik othe dabiltza hemen « gizon horiek ? ikusi othe gaituzte ? » Izerdi hotzak estaltzen dio Ganichi bisaia guzia. Alfer izanen othe dire bada iragan neke eta entsegu guziak ? salbamenduko porturat heltzian erori behar othe da printsesa etsaien eskuetarat ?

Bizkitartian, gardak hurbilltzen dire; yadan Ganich gordia den sasiaren onduan dire. Ezagun da chispek ostrailla ukituz egiten duten harrabotsa. Gehiago dudarik ez da. « Ikusiak gare !... » Laster entzuten dituzte garden elhe berak :

— « Zer apokiña ! » zioen batek, « ber-« rogoi-eta-hamar milla libera printsesa « atzematen duenarentzat ! Ez dikek harrek « urte tzarren beldurrik zahartzian. »

— « Ez diagu guretzat hori ! » dio bertziak, « ez duk hunat ethorriko printsesà-« rik ; hegalak behar litizkek mendi hau « behera yausteko ! »

Hitz hauk azkenak Ganichek aditu zituen, gardak urruntziarekin. Laster itzaldu ziren bidechkaren itzulian, eta, atsegiñekin Ganichek ikusi zituen ihesi gaten azken hirriskuen beldurrak. Orduan gure bidiantiak berriz abiatu ziren muga alderateko bidian.

Zer biaya nekagarria printsesarentzat! mendi zorrotzen patarreri gora behera, ondo gabeko erreketan, sasieri trebes, doidoia gelditu han hemenka ahalik gutiena hats hartzeko. Emazteki miragarri horrek zer kuraya etzuen irakutsi trebesia guzien erdian! Kasik bortcha egin behar zioen Ganichek leku gaitzenetan besuetan erabiltzerat bere buruaren uzteko hari eta Manueli.

Azkenekotz, heldu ziren chirripa baten bazterrerat: hura zen Frantzia eta Espaiñia berechten dituen muga. Ganich, saltoz iragan eta erregiñarekin chirriparen bertzealderat, gelditu zen bide hegian zen harri

handi bati kontra, eta haren gaiñian eskua emanez : « huna Espaiñia ! » dio printsesari.

Erregiña, atsegin handienian hurbilltzen da Ganichen ganat eta musu ematen dio hark irakutsi harriari. Hirriskuak, nekiak, ahanzten ditu eta libertatiaz arindua, lasterka dua doidoia oraindik segi dezaketen lagunen aintziñian. Handik lekhora, laster printsesa eta haren lagunak igan ziren azken mendichka baten panttuparat : zer choramenduan etzituzten begiak hedatu hurbillian agertu zitzaizkoten ikuspen bihotz altchagarrietarat !

Han ziren, hurbill zelayan, karlisten armadaren belazko etchola churiak, lerroka hedatuak; soldaruak harat hunat zabilltzan; hekien gaphelu churi eta maipolis urdiñak alegera ezagun ziren mendi ferdiari buruz. Batzuek kantaz zagozin, bertziak gitarra yotzen; hauk fandango erhotan itzulika, hek yarriak multzoka han hemenka pichtu suen

inguruan, elheketan zauden esku eta besuak erabilliz eskaldunen haro ohituarekin. Urrunago ostraillpetik ageri zen belazko etchola churi berezi bat, bandera gorri bat airian zabillakona: hura zen erregeren yar tokia. Uhartzian, eliza bateko ezkilla dorre antzerekin gora altchatua eder zaguen ageri zeru urdiñian.

Orduan Ganich, karlisteri agindu bezala, hasten da irrintziñaka, adiraazteko erregiña han dela.

Ordu berian, peza kolpien orruek iñharrusten dituzte mendiak, atabalek eta turrutek atzartzen oihartzunak bere gudutiar harrabotsez. Armada guzia bibaka dago; ezkillek errepikatzen dute. Aintzindariek lerrotarat deitzen dituzte soldaruak; zaldiak zaldunekin alegeratuak yauzika bateratzen dire, eta armek iduzkian darioten iñar dichtiantez llilluratzen dituzte begiak. Orduan, armadako soiñulariek diote hemen *ai! ai! ai! mutilla*, hantche *yernikako arbola.*

Orduan errege, aintzindari oste bat ondotik ethortzen da erregiñaren biderat, eta laster bateratuak guzien aintziñian elkhar besarkatzen dute.

## CAPITULU XIVna

---

## AKHABANTZA

Dembora luzez, karlisten armadak ibilli ziren bitoriaz bitoria. Heyen aintzindari Zumalakarregi, Elio, Egia, Villareal, Zariategi, Urbistondo, Las Torres eta bertze hainitz yeneral aiphatuek, bere balentriez, leihal iduki zuten bitoria don Karlosen banderari.

Orotan mintzo ziren Kabrerak Araguan zituen garaiziez, errege eta erregiña zabiltzanian bere lagun leihalen hirriskuetan partzur.

Baiñan, egun batez, ondikotz! traidorekeriak sartuz karlisten lerruetan, alfer egin zituen erran ditugun gerlarien entseguak.

Uzkurdurak eta azkenekotz etsimenak hartu zuen karlisten armada guzia; soldaruak, fidantzia galduak aintzindarietan, zein bere alde barrayatuak abiatu ziren eta laster karlista bentzutuak yasaiten hasi Kristiño, ordutik espaiñiako nausien, uztarria; don Karlos eta erregiña ikusiz etzitzayotela gehiago gelditzen ihesiaz edo gatibotasunaz, behar bada heriotziaz, bertze hauturik, eman ziren desterrurateko bidian, utziz espaiñiako lur, hambat ohorez karlisten guduek beregindua.

Bakharrik Kabrera yeneralak, Araguako mendietan zuen omen ozpatuari esker, oraiño zabilkan karlisten bandera eta egiten gudu ona Kristiñuen kontra; baiñan gizon handi hura, bere egin ahal eta balentria guzien gatik, lehertua bethi berratuz zuan etsayen ostiaz chokatua bere soldaruen azken on-

darrekin etchatua da Frantziako lurretarat eta harekin suntsitu ziren Espaiñiatik don Karlosen azken lagunak.

Mundu hau aldamio handi bat bezala da, erretaulez bethia : batzuek atsegiñaren eta zorionaren itchura irakusten dute eta bertzek orhoitzapen mingarriak gogoratzen.

Hemen ama batek musuz ferekatzen ditu inguruan dituen bere haurrak ; heyen irriez dohatsu da. Eta, maiz, argamas bat artian, bertze ama batek, marrasketan, oinhatzez funditua, bustitzen du nigarrez bere seme haiñ maitiaren gorphutz hilla.

Familia bat ontasunez gainditua igeri zorionian bizi da, eta etche berian bertze familia bat gosiak irestera dua, aitak ez duelakotz bere nigarrez deus bertzerik haurreri sokorri emateko.

Gizon bat zorionezko ametsetan loharkatua da: ethorkisuna irriz agertzen zaio guzia lore eta urhe; eta, haren etchiaren

atalapustan, trikatu etsaiak, arphegi ikharagarri batekin, goguan dabilka horren galtzia.

Baiñan eskas da aldamio hortan erretaula latzgarriena.

Erretaula hura gorderik daguen erromesiarena da, zeren zorigaitzian eroriz geroz, erromesa bere bakhartasunari utzia den : guziez ahantzia da eta uste gabez orhoitzen balimbadire hartaz, yendiek irri egiten dute urrikalmendurik gabe.

Bizkitartian, zembat eskasia, zembat urriki kirets, zembat oiñhatze arraillagarri ehorzten direnak etchiaren itzalpian !

Erromes ahalketua auhenetan dago ichilltasunian, igurikimena galtzen du, bethi buruz buru bere buruarekin; bere haurren begiratziak berak latzten du. Baiñan, kampuan irakutsi nahi ditu oraiño bere leheneko galdu aisia eta errechtasunak ; yaunzten du ere bestetako aldagarri beltza, iragan aberatstasunen azken ondarra. Eta haren begi

kechatua beha dago aldetik dabilzkion yendien begiari; beldur da bere kopetako illundurak salha detzan bethi gorde nahi lituzken eta barnetik iresten duten bihotzmiñak.

Bizkitartian bada ez dute bethi erhokeriek, ez emaitza zoro-egiek errekarat arthiki gizona.

Halere, egunak banazka baduazi, ezin dio gehiago garai etchian nausi yarri zayoen gosetia.

Orduan, ihes egiten du erromesaren zorigaitzez baliatzen ohi diren yendetarat.

Etcheko traste ederrak, urheria baliosak biziko egun ederren orhoitzapenak, salduak dire ez deusetan.

Eta, egun batez, erromes ahalketua hebaindua eskasiez eta pairamenez, hilltzera dua, nihork urrikaldu gabe, adichkide esku bat ethorri eskasian azken oreneraiño gordetzia billatu duen beharraren arintzerat.

Holakua da, bada, liburu huntan argita-

rat ezagutaraztia billatu dudan gizonaren sortia; irakurtzailliak barka dezadala baldiñ hemen egin baditut zembeit solas alegera orhoitzapen mingarrien auzo.

Ganichek yoko eman zituen don Karlosen zerbitzuan zituen guziak eta prestamuz utzi karlisten armadari laur ogoi eta hamar milla libera diru.

Holako dirutze batez gabetziak kordokan eman zuen haren izatia, etzen halere errenkuratu ez eta behiñere beriaren galdetzen hasi hartaz baliatu zireneri.

Egia bada ere, don Karlosek agindu ziozkan Ganichi urtheko hemezortzi ehun libera; baiñan agintza hori alfer gelditu zen Ganichentzat deus ondoriorik gabe.

Eta Karlist eta Kristiñuen gerla akhabatuz geroz, hautsi ziren Ganichen karlistekin lokharriak; baiñan gelditzian don Karlosen lagunekin haren ariak, etzituen galdu bere herritarren amudiua eta, guziez ungi ikhusia, aithor hoberenak zituen baz-

ter guzietan. Nihori ezbaitzuen ematen bere beharren berri, guziek aisian zaukaten zela.

Bizkitartian, Ganich aspaldian beharrarekin borroka zaguen, eta ahal guziak higatzen nolazpeit gordetzeko bere eskasia, begietarat errauts eman zezaketen itchura enganakorrez, eta gibelatzeko hambatenaz azken errekan eman behar zuen erorikua.

Billuzten hari zen haren etchia, banazka khenduz handik Ganichek maitienak zituen iragan egun ederretako orhoitzapenak.

Laster behar miñak, saryantek ethendua, ezin buru egiñez utzi behar izan ditu zituen ontasun guziak bere hartzeduneri. Ene begien bichtan egin du Ganichek bere azken sakrifiziua, eta, entzunez haren botz hats gorapenetan ithua, ikusiz haren arphegi bihotz-miñak ubeldua eta begietarik erortzen zitzaizkion nigarrak, ezagutu dut haren zola gabeko erromesia. Orduan, bortchaz atheratu eta errekarat erori delako aithorra, billatu dut gizon dolu-garri huni kuraye

ematia mintzatuz eta hari gogorat ekharriz lehenago, behar orduetan, lagundu dituenen izen ezin ahantzi dituenak.

— « Ez, ez, yauna; ez dut oihurik egi-
« ñen ezagutza zor nauteneri; ez naiz ba-
« liatuko orai naizen beharraz egin dituz-
« kedan iragan ungiez orhoitarazteko. »

Eta, bihotza zaurtua nigarretaraiño Ganichen yenerostasunaz erromesian berian, erran diot : « Etzare nahi mintzatu, Ganich;
« bada ni mintzatuko naiz zuretzat. »

Zueri nago beraz, español ozpatuak; zueri, don Karlosen alde izan edo zaretenak : miretsi duzue Ganichen arima ederra. Zueri nago, bihotz oneko zuen herria maite duzuen guzieri, nahiz erregetasunian edo errepublikan. Erregeren amudiua bihotzetan daukazue erliyone berri bat bezala; siñheste eta esperantza berek bat egiten zaituzte familia bereko haurrak bezala. Elgar-

ren lagun, sokorri eta lekuko zarete, anayak bezala. Adituko nauzue eta ez duzue utzi nahiko beharrian, erromesian, zuen banderaren azpian lagun on, saririk gabe, ibilli den gizona.

Haurretik gizonari emaiten zayoen yakitatiak fedia haren baithan pichtarazten du; maiz ere bere ethorkiak irakusten dio zein banderaren azpian ibilli behar duen. Baiñan ez duenak yakitaterik, ez buraso zaharretarik bidia ematen dioen irakuspenik, ez du bere bihotzeko kharrak eta biziko gerthakariek ematen dioten lehia baizik. Mendi eta oihanen erdian hazia, maithatzen du agertzen zayoen bandera, zuzen bidekua iduritzen balimbazaio. Ganichek errege nahi bat lagundu du, imperadore nahi bat orobat lagunduko zuen.

Yakitate gabeko gizonak ez daki gizonetik gizonerat, aitatik premurat korua egortzen duen legia. Erromes bat gerthatzen denian haren etcheko atalapustan, aterpea

galdez, ikusi orduko, besuak zabaltzen diozka.

Zueri nago beraz, churia edo gorria izan dadien zuen bandera, zueri, guzien gaiñian ematen duzuenak ohoria, zuhartasuna eta leihaltasuna, zorigaitzaren koruaz edertuak direnian.

Zueri ere nago, mendeko dohatsu, haren ganik ditutzuenak gozatzen ditutzuen edergaillu eta atsegiñen ithurri asko; zuentzat zembat hirriskutan ez da ibilli!

Lehenago maite zinduten eta billatzen haren adichkidantza; yartzen zen zuen mahaiñian; ukhatuko othe duzue eta debalde utziko erromesiak yo duenian?

Ez, ez duzue hola egiñen; nahiko duzue frogatu guzieri atsegiña bezala ezagutza ere bizi dela zuen bihotzian.

Eskaldun ene herritar maite, bihotz on eta khartsuak, zuentzat ene azken hitza. Nik bezala ezagutzen eta miresten duzue Ganich eta deitzen egiazko eskalduna. Zuek

ere lagunduko duzue beharrian, ez duzue nahiko dolugarriak izan daiten haren azken egunak : mintzatuko zarete hartaz, ezagutzen ez duten guzieri, erranez Ganich dela egiazko ohore, leihaltasun eta kalapuaren miraill berezia, gure mendean eta gure eskal-herrian.

# ZÜBEROTARRER *

Helez ari nitzaizie aren, Español nobliak, admiratü beitüzie gizon horren korajia eta leyaltarzüna; helez ari nitzaizie, leheneko Karlostiar güziak; oihü egiten düt zier ere, gizon bihoztoyak, behar bezalako egimbiden sinhestia errelijione bat beita zientako: pharteliantgua familia handi bat bezala da, eta familiako alderdi güziak batak besteren zordün dira. Eskeleguan ez düzie ütziko

* Pour plus de régularité et pour faciliter les comparaisons, l'orthographe des quatre spécimens suivants des principaux dialectes basques, autres que celui dans lequel a été écrit le présent livre, a été ramenée à un système uniforme. Ainsi, là où les Souletins ont l'habitude d'écrire *ou* et *u*, on a mis *u* et *ü* ; là où les Guipuzcoans et les Biscayens écrivent *que*, *qui*, *gue*, *gui*, on a mis *ke*, *ki*, *ge*, *gi*, etc.

hain leyalki zien banderari jarraiki den gizona.

Eskolaguak phitzerazten dü gizonian behar bezalako egimbiden sinhestia, sorthkürak aldiz erakhusten deyo üsütan zuin bandera pian ebili behar dien. Bena eskolagua eta leinhüra gabe dena, gora beheren eta bere bürü beruaren arau sinhestkortzen da. Oihan eta mendi erdietan hazirik onest üdüri zaikon aldialat irailtzen da. Ganichek erregetü nahi zen bat lagüntü dü, bardin ere lagüntü zükien emperadoretü nahi zatien bat.

Jakin gabiak ez dakitza zer dien primüguako legia eta prinzen züzenak erresumako khoruala. Bere borthan ikhusten dü, atherbe galthoz, zorigaitzaz zaflatürik den bat, eta besuak zabaltzen deitzo.

Hortakoz aren helez ari nitzaizie, bandera churi edo gorri dünak, ustia beno gorago altchatzen 'tüzielakoz ohoria, korajia eta leyaltarzüna, zorigaitzaren khoruaz üngüratürik direnian.

Helez ari nitzaizie orano zier ere, orai irus zireyenak, gizon horrek eskarnioz eta bost perillen khostüz eman deitzien huntarzünez. Güti diela, khidetü zünüzien, zien mahañian jarten zen; eskeletü delakoz ükhatüko duzieya egün? Ez, ez, orok erakutsiko düzie eskerrak zien bihotz barnen lekhütto bat badiela.

Ziek aldiz, herritar maitiak, üskaldün bürü bero eta bihotz hunak, gizon horren balentiez orhitzez, ahal oro egizie zahartze hun bat ükhen dezan eta bazter güzietan errazie gizon hori balentiazko eta ohorezko mulde bethegin bat dela.

# BACHI-NAFARTARRER

---

Zier beraz mintzo niz, Español haiphatiak, zoinek amiratu baituzie arima eder haren kuraya eta estekamendia; zier orori don Karlosen lehengo aldekariak; zier ere, bihotzezko gizonak, zoinendako fede politikua egiazko errelijione bat baita: partidu bat da familia handi baten pare eta familia bateko membruek bat bestendako ihardesten dute. Ez duzie utziko behartasunian hain jeneroski zien bandera lagundu izan dien gizona.

Ukhan dien eskolak finkatzen dako gizonari bere opinione politikua eta ardura bere sortziak señalatzen dako zoin banderaren pian ibili behar dien. Bana ez dienak ez eskolarik ez eta obligatzen duten familiako

erakuspenik, ez du zirkonstanziek eta bere karakteraren ideya soberakinek sorharazten dakoten fedia bezik Hazia oihanen eta mendien artian; borthizki berotzen da, zer nahi izan dadin, hura galdegiten dien partidiarendako, onesta ber iduritzen bazako. Ganichek lagundu du erregetasuna nahi ziena; emperadoregua nahi zukena izanen zen eta haren banderak bardin lilluraturik ezarriko zien.

Gizon jakitate gabiak ez du ezagutzen ez fundariozko legia ez eta khoro baten gañian printzek 'tuzten zuzenak. Ikhusten du maluros bat bere borthalatzian karitatiaren galdoz eta eskia hedatzen dako.

Halahala, heldu nizauzie, partidu guzietako gizoner, ezartzen duzienak opinione politikuaren gañetik ohoria, kuraya eta estekamendia, desfortunaz inguraturik gelditu direnian.

Zietara ere heldu niz, egun uros ziretenak; zor duzie gizon hari ingurikatzen ziuz-

ten ospa; ziendako haimbeste lanjer kurritu izan ditu. Berriki haren ondotik zinabiltzaten, zien mahian jartzen zen : orai, behartia delakotz, ukhatuko duzea ? Ez, ez, erakutsiko duzie eskerrak zien bihotz barnian duziela.

Zietaz bezambatian, herritar maitiak, heskualdun arima ederra eta bihotz jenerosa duzienak; ziek oro amiratzen duzie gizon hura eta deithatzen nik bezala heskualherriko gizon famatia, ez duzie solamente lagunduko, bana juntatuko 'tuzie ono zien indarrak hari zahartze uros baten segurtatzeko eta lekhu guzietan izendatuko duzie balentriaren eta ohoriaren etsemplu osuena bezala.

# GIPUZKOARRAI

---

Zuei bada orain au zabaltzen diezutet, Español biotzberak, zuen gazte demborau gizon oparo onen alaigoa eta leyaltadea ezagutu dezutenai; zuei ere don Karlosen anziñako aldekorrai, zeñeentzat zuek, gauza onen gañean siñisten dezutena, izan bear litzake erreligio bat bezela; zergatik alde batekoak izan bear dira familia baten antzekoak, zeñean senide guztiak alkar lagundu bear diote. Ez, ez dezute utziko gosiak iltzen, ain alaikiró zuen ausiagatik guztia galdu zuen gizona.

Ematen diguten azierak adierazten digu, zelatan siñistu bear degun, errier andearen gauza gañean; eta askotan nola jayo geran alá jarraitzen diogu balder oni edo ari.

Alabañan azkuntza gabeko gizonak, zeñi ez diote bere burasoak etcheko oiturak erakutsi, ez du beste siñispenik, egunoroko paradak eta bere buruaren sufritasunak erakusten diotena baizik. Basoetan edo mendietan jayo dana gutchirekin berotzen da eta jarraitzen zayo edozeñ aldekori, ona usten badu. Ganichek ekurtu zion erreino bat eskatzen zuen bati, eta orobat llilluratuko zan izan bazan ere imperioa.

Gizon jaquinezak ez daki zer dan lege salika, ez eta ere lerren batek duen edo ez zuzenik koroiará; ikusten du bere atarian dagoela doakabea eta eskua lusatzen dio.

Orrengatik aurqueztuten natzazute, o zuek alde guztietako gizonak, zeñeentzat onorea, batek bere burua ukatzea eta eman naya dira bere aldekoa izatea bañon gauza obeto begiratzekoa, batez ere, gizon bat eroria ikusten degunian.

Azkenian zuekiñ egiteko det, mundu ontako doatsuak, zeñek ausaz dezuten abera-

tstasunaren gizon oni zor diozutenak; zuen gatik galbide andietan ipiñi zan bere gazte demboran; eta orduan arren billa ibiltzen ziñaten zeuren maian hura ischierazotzeko. Eta orain zuek gandik astanduko dezute zarra eta beartua dagoelako? Ez orische, eta onelá on egingo dezute nere siñistea, au da, zuen biotzean oraindik lekua dagoela esker gogorako.

Zuei dagokizuten ambatean, o nere erritar maite euskaldun biotzberak, zurbira ontako humanta deitzen diozuten gizon onen zaleak, zuek au lagundu, ezezik, deritzait alegiña egingo dezutela, bere zarraroan, miseriaren maldapean jartzeko; eta beti, eta leku guztietan, irazagutuko dezutela gizon au, errutasunan, ontasunan eta leyaltasunan, prestuena izan dana bezela.

# VIZCAITARRAI

—

Orregaitik zeubei berba egiten deutsuet, Español ozpatubok, zeuben gazte demporan mirarilu dituzuezanok gizon onen lealtadia ta baloria; zeubei guztiai don Karlosen anchiñako partidariok; zeubei bere, errcligiño bat legez fe politikia dozuen bihotzezko gizonok: partido bakotcha familia handi bat da; familia bateko guztiek alkar lagundu biar daue. Ez dozue miserijan itchiko arima guztirik lagundu zinduezan gizona.

Ikasi dauen gauzak emoten deutse gizonai beren fe politikia, ta askotan diñotze ze banderiari jarraitu biar dauen. Baña eskolarik ez dabenak, gurasuek ez badeutsaez etcheko oiturak irakutsi, ez dau beste siñisterik bere burubari lekubek ta bere arimiak

emoten deutsaenak baizik. Oijan eta mendijen erdijan jayo dana gitchiakaz berotzen da, ta miraritnz jarraituten jako edozeñ partidori, ona iruditnten bajako. Errege nahi bat lagundu daben legez, Ganichek imperadore nahi bat lagunduko eban.

Jakin baga gizonak ez daki zer dan lege salika, ez eta bere nola printzek koruak aurkituten dauen. Bere atean miserija dun bat daguela ikusiz, besuak luzatuten deutsaz.

Zeubei orain berba egiten deutsuet, partido guztietako gizonok, ondra, balore ta lealtadia lelengo lekuan imiñi dituezanok, desgraziko koruaz edertuak ziranian.

Zeubei bere berba egiten deutsuet, eguneko doatsuok; inguruan dozuen gauza aberatsak Ganichen eskubetatik artu zenduezan, ta zeubendako Ganich galbide andietan imiñi zan azkotan bere gazte urtetan. Dempora bat zan, zeñean au ondratuz zeuben maijan jarri zenduen; gaur ete ukatuko dozue zarra ta biartuba daguelako?

Ez, ez, irakutsiko dozue zeuben bijotzetan leku on bat daguela oraindik eskar gogorako.

Baña zeubek, o neure erritar maite bijotzezko euskaldunok, zeñek gizon au mirarituten dozuen, ta neugaz deituten erriko lorija bat; au lagunduko dozue, baitabere guzien indarrak batu ezkero onen zahartutiarendako atsedenezko aterpe segur bat egingo dozue, ta esango beti, leku guztijetan, balore ta ondra prestuenak zituala.

On trouvera ci-après un choix de proverbes basques (dialecte labourdin), recueillis à St-Jean-de-Luz et aux environs, accompagnés d'une traduction française aussi littérale que possible. Il n'a pas paru utile de joindre une explication à quelques-uns de ces proverbes dont le sens est très-obscur; le lecteur en appréciera lui-même la portée. On s'est attaché à ne donner que des proverbes essentiellement basques de fond ou de forme.

Cf. le recueil de proverbes basques d'Oihenart (*Paris*, 1657; *Bordeaux*, 1847; reproduit par Mahn, *Denkmaeler der Baskischen Sprache*, *Berlin*, 1857, p. 57-67) et les listes de proverbes basques données dans les ouvrages suivants : *Notices sur les proverbes recueillis par A. d'Oihenart*, etc., par G. Brunet, *Paris*, 1859; — *Compendio Histórial de Guipuzcoa*, par Isasti, *St-Sébastien*, 1850, p. 171-174; — *Denkmaeler*, etc., déjà cités, p. 56-57; — *Guide ou Manuel de la conversation français-basque*, par l'abbé Darthayet, *Bayonne et Biarrits*, 1861, p. 275-283; — *Guide de la conversation français-basque*, par L.-M.-H. Fabre, *Bayonne*, 1863, p. 354-357.

# CHOIX DE PROVERBES BASQUES

---

1. *Ardi bezembat anchu.*
   Autant de brebis-mères que de jeunes brebis.

2. *Arrats gorriak eder aldi.*
   La soirée rouge (annonce) le beau temps.

3. *Arrudarik tzarrena egiten du harrabotsik handiena.*
   La plus mauvaise roue fait le plus grand bruit.

4. *Aseak gosearen berri ez daki.*
   Le rassasié n'a pas de nouvelle de la faim.

5. *Asko ahaidekin baiño hobe da atzekin egitekoa.*
   Il vaut mieux avoir affaire aux étrangers qu'à beaucoup de parents.

6. *Auzo ona duenak goiz ona.*
   Qui a bon voisin (a) bon matin.

7. *Bakhotchak bere burua du etsai handiena.*
   Chacun est à soi-même son plus grand ennemi.

8. *Bakhotchak bere bergaz bertzeak neurtzen ditu.*
Chacun mesure les autres à son aune.

9. *Bas-oillarra etchean nausi.*
Le coq sauvage est maître dans sa maison.

10. *Beltz guziak ez dire ikhatzak.*
Tout ce qui est noir n'est pas charbon.

11. *Bichtatik urrun, bihotzetik urrun.*
Loin de la vue, loin du cœur.

12. *Bururik ez duenak chapel beharrik ez.*
Qui n'a pas de tête n'a pas besoin de chapeau.

13. *Bururik ez duenak zangoak behar ditu.*
Qui n'a pas de tête a besoin de ses pieds.

14. *Cherri goseak eskurrez amets.*
Le cochon qui a faim rêve aux glands.

15. *Chituek amarekin ikasten dute kabazkan.*
Les petits poulets apprennent de leur mère à glousser.

16. *Emok emailleari, izok egilleari.*
Donne à qui donne, fais à qui fait.

17. *Etche guzietan marikolak egosten eta gure etchean panderaka.*
Dans toutes les maisons cuisent les haricots, mais dans la nôtre à pleines marmites.

18. *Etcheko hautsak behar du etcheko sua estali.*
C'est la cendre de la maison qui doit couvrir le feu de la maison.

19. *Ez diozu igerika irakutsiko urean den arraiñari.*
Vous n'apprendrez pas à nager au poisson qui est dans l'eau.

20. *Ez dire zuri guziak iriñak.*
Tout ce qui est blanc n'est pas farine.

21. *Ez duzu atzemanen hortzez illargia.*
Vous n'attraperez pas la lune avec les dents.

22. *Ezkont eguna aise izanaren biharamuna.*
Le jour du mariage (est) le lendemain de la vie tranquille.

23. *Ez utz ihes egiterat eskuko choria airekoa izanen duzulakoan.*
Ne laisse pas s'enfuir l'oiseau qui est dans ta main en attendant celui qui est dans l'air.

24. *Ganich tzar bezembat mari tzar.*
Autant de mauvais maris que de mauvaises femmes.

25. *Geroa alferraren leloa.*
Après, c'est le refrain du paresseux.

26. *Gizon ttikiak maiz harrabots handia.*
Un petit homme fait souvent un grand bruit.

27. *Gizon Yainkotiarrari Biriatu eta Donostia bardin lakhetgia.*
A l'homme de Dieu Biriatou et Saint-Sébastien plaisent également.

28. *Gizon tzarra goizean uzten duenak arratsean atzematen du.*
Qui quitte le matin un mauvais homme, le retrouve le soir.

29. *Goizean goiz yeikitzen denak arratseko zerbeit egiten du.*
Qui se lève de bonne heure fait quelque chose pour le soir.

30. *Goiz gizon berant ezkon.*
Celui qui est homme de bonne heure se marie tard.

31. *Goiz gorri, hegoa edo uri.*
Matinée rouge, vent de sud ou pluie.

32. *Guazen bertze herrirat, han ere zakurrak badire.*
Allons dans un autre pays, là aussi il y a des chiens.

33. *Gure gatuak, bustana luze, bera bezala bertzeak uste.*
Notre chat, qui a la queue longue, croit que les autres sont comme lui.

34. *Gure mandoak umerik ez umiaren miñik ez.*
Notre mulet n'a pas d'enfant; il n'a pas non plus le mal de l'enfant.

35. *Hagiñean min duenak maiz mihia harat.*
Qui a mal aux grosses dents y porte souvent la langue.

36. *Haize hegoa andrearen gogoa.*
Vent du sud, désir de la femme.

37. *Haritz eroriaren azpian errech da ezpalak egitea.*
Sous le chêne tombé, il est facile de tailler des copeaux.

38. *Iriñetan erho, zahietan zuhur.*
Fou dans la farine, sage dans le son.

39. *Itsasoak adarrik ez.*
La mer n'a point de branche (qu'un noyé puisse saisir).

40. *Kampoan uzo, etchean bele.*
Dehors palombe, dans la maison corbeau.

41. *Kausitzen da bethi mahaiñaren araberako dafailla.*
On trouve toujours une nappe à la mesure d'une table.

42. *Lasto su laster su.*
Feu de paille feu rapide.

43. *Maiz ederki nahi dena maiz itsuski izanen da.*
Qui veut paraître souvent beau, paraît souvent laid.

44. *Mando merkea, hiretzat nekea.*
Mulet bon marché, peine pour toi.

45. *Martcho lore, urhe lore; aphirill lore, are hobe, mayatz lore gabea baiño hobe.*
Fleur de mars, fleur d'or; fleur d'avril vaut mieux encore; fleur de mai vaut mieux que pas du tout.

46. *Mihiak ez du ezurrik hausten, baiñan bai hautsarazten.*
La langue ne brise pas d'os, mais elle en fait briser.

47. *Nahi duzuna erraten baduzu, nahi ez duzuna adituko duzu.*
Si vous dites ce que vous voulez, vous entendrez ce que vous ne voulez pas.

48. *Non fida eta han gal.*
Où l'on se fie, là même on se perd.

49. *Nork bere choko nork bere gocho.*
Qui a son petit coin a son bonheur.

50. *Ogi hasia yankara.*
Le pain entamé invite à manger.

51. *Oihanean haritzik makurrenak zuzenena dela uste du.*
Le plus tordu des chênes d'une forêt pense qu'il est le plus droit.

52. *Oiñen bethe zapata.*
Le pied doit remplir le soulier.

53. *On hartua nihork ezin khen.*
Ce qui est bien obtenu, personne ne peut (te) l'enlever.

54. *Orhiko choria Orhin lakhet.*
L'oiseau de l'Orhi aime à être sur l'Orhi.

55. *Otsoak bere haragitik ezin yan.*
Le loup ne mange jamais de sa propre chair.

56. *Sasitik ilkhi eta berhoan sar.*
Sortir du buisson pour entrer dans le fourré.

57. *Seme hasten urhe hasten.*
Avoir un fils (c'est) avoir de l'or.

58. *Senhar duenak yaun badu.*
Qui a mari a seigneur.

59. *Soiñuaren arabera yauzi eginen dut.*
Je sauterai suivant l'instrument (de musique qui jouera).

60. *Sudurra pikatzen denean ahoa odoltsu.*
Quand le nez est coupé, la bouche est sanglante.

61. *Urrungo eltzeak urhez, urbildu eta lurrez.*
Un vase qui de loin semblait en or, n'est plus que de la terre lorsqu'on s'en est rapproché.

62. *Usoak gan eta, sareak heda.*
Tendre les filets après que les palombes sont passées.

63. *Yakiteko hartzen ikasazu ematen.*
Pour savoir prendre apprends à donner.

64. *Zaharraren umea martzuka.*
L'enfant du vieux est un crétin.

65. *Yarrekiz yarrekiz achari zaharrak atzematen du oilloa.*
A force de patience, la vieux renard attrape la poule.

66. *Yinkoa berankor da baiñan ez ahanzkor.*
Dieu tarde, mais il n'oublie pas.

67. *Zahia iriñaren eske.*
Le son (offert) pour avoir la farine.

68. *Zapata zuriak paperez, uria denean batere ez.*
Souliers blancs de papier, s'il pleut, il n'en reste rien.

69. *Zembatenaz gorago altchatuko baitzare, hambatenaz beherago eror zaitezke.*
Plus haut vous vous éléverez, plus bas vous pourrez tomber.

# EXPLICATION

## DE QUELQUES MOTS RARES OU DIFFICILES

### EMPLOYÉS DANS CE VOLUME.

---

*Adaraire*, orage.
*Ahuku*, *ahulku*, *ahoku*, convoi funèbre.
*Aithor*, *aitor*, approuvé, bien vu, sympathique.
*Aldamio*, galerie, balcon.
*Alditchariu*, se trouver mal, défaillir.
*Alha*, pâturage.
*Andana*, foule, parti.
*Antze*, talent, propriété à.
*Apokiña*, aubaine, bonne part
*Ari*, rapport, entre-gent, etc.
*Arrailladura*, fente, lézarde.
*Arrunt*, simple, commun.
*Asentu*, siége, fondation, barrage ou mur en pierre.
*Asko*, beaucoup.
*Atalapusta*, vestibule.
*Atherri*, *atheri*, calme, temps serein qui succède à la pluie.
*Aterpe*, *atherpe*, *atharbe*, abri.

*Baillia*, le bailli, le maire.
*Beriala* pour *berehala*, tout de suite.
*Berme*, caution.
*Berratu*, redoubler, augmenter.

*Cheletatu*, espionner.
*Choragarri*, séduisant, éblouissant, enivrant.
*Choratu*, séduit, ébloui, enivré.
*Chuchtur*, buisson.

*Doidoia*, à peine.

*Ehortzi*, *ehosti*, enterrer.
*Eñada*, *ainhara*, hirondelle.
*Entsegu*, *entseyu*, effort.
*Erranzute*, discours, publication.
*Erretaula*, tableau.
*Eskatima*, bagarre, dispute, querelle.
*Ezten*, aiguillon, dard, alène.

*Finkatu*, raffermir, consolider.

*Gare*, *yoare*, clochette au cou des bestiaux (principalement des moutons).
*Gothor*, solide, ferme.

*Hamikatu*, affamé à l'extrême.
*Harrisi*, *harrasi*, muraille en pierres.
*Higuñgarri*, odieux, haïssable.
*Hosiñ*, précipice.
*Hurren*, presque, près, très-près.

*Iduzki*, *ihuzki*, *iruzki*, *iguzki*, soleil.
*Igeri*, nager dans la pleine eau.
*Iharrusi*, secouer rudement.
*Imiñi*, mettre, poser.
*Iñarrusi*, secouer rudement.
*Intha*, marais, marécage.
*Intzurra*, marais, marécage.
*Ipiñi*, mettre, poser.
*Itzuri*, s'échapper, sourdre.
*Izurrite*, épidémie.

*Karrika*, rue principale d'un village.
*Kopha*, boîte.
*Kukurustegi*, clocher, beffroi.
*Kurrida*, course.

*Lamiategi*, grotte, palais des fées.
*Lastaira*, paillasse.
*Liraiñ*, couleur de lin, azuré.
*Lokharri*, lien.

*Markha-alasiak*, les dressoirs.
*Mintzaira*, le langage.

*Oghe*, lit.
*Ohartu*, s'aviser, remarquer.
*Oihartzun*, écho.
*Olatua*, *olatea*, la vague, la vague houleuse.
*Orde*, au lieu, à la place.
*Ordenu*, testament.
*Orro*, vacarme, fracas, bruit.
*Ostrail*, feuillage.

*Panttupa*, sommet de colline.
*Partzur*, *parzun*, associé.
*Permagune*, pression, effort extrême.
*Pirpira*, inquiétude, anxiété, tressaillement.

*Sakaillatu*, saccager.
*Salatatu*, espionner.
*Sar-hiria*, *sarrera*, l'entré
*Sarri*, bientôt après, un pe plus tard.
*Sorkhatu*, heurter, pousser.
*Sueltatu*, rencontrer, écarter.

*Teteletu*, étourdi, abêti.
*Thana*, viens ô homme, (à une femme on dit *nana*).
*Tipustapaste*, fait avec précipitation, d'une manière imprévue.
*Tiraiñ*, vague, flot (par le beau temps).

*Uhartz*, horizon.
*Ukhan*, *ukhen*, avoir
*Urtchintcha*, l'écureuil.
*Usna*, le flair.

*Yazarkor*, insupportable.

*Zirimola*, tempête, tourbillon.
*Zitoitza*, gouttelette.
*Zizkolatsu*, sifflant.
*Zotzerbatu*, s'effarer, s'effrayer.
*Zuhaitz*, arbre en général.
*Zurruchtan*, à flots.

# BILLAPIDIA


Zembeit hitz eskalduneri . . . . . . . . . . . . . . . . v
Avant-propos . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . vii
Ganich menditarra, pertsuak. . . . . . . . . . . . . ix
Complainte basque . . . . . . . . . . . . . . . . . . . xiii
Luis Luzien Printziari . . . . . . . . . . . . . . . . . xvii
Cap. Ia. — Atheka gaitz . . . . . . . . . . . . . . . . 1
Cap. II. — Tipustapasteko yauregia. . . . . . 13
Cap. III. — Fedia eskal-herrian . . . . . . . . . 32
Cap. IV. — Belzunzeko yauregia. . . . . . . . . 33
Cap. V. — Eskaldun yaunsturak eta yokuak. . . . . . . . . . . . . . . . . 45
Cap. VI. — Galerna . . . . . . . . . . . . . . . . . . 57
Cap. VII. — Soldaruak Makayan . . . . . . . . . . 67
Cap. VIII. — Printsesaren ihes-egitia. . . . . . . 79
Cap. IX. — Ganichen etchiaren sethiua. . . 89
Cap. X. — Ahukua . . . . . . . . . . . . . . . . . . . . 103
Cap. XI. — Arroka-zilloko solasak. . . . . . . 117

Cap. XII. — Ibayaz bertze-alderatzia...... 145
Cap. XIII. — Mugaz bertze-alderatzia...... 153
Cap. XIV. — Akhabantza................ 165
— — Züberotarrer............... 176
— — Bachi-Nafartarrer.. ........ 179
— — Gipuzkoarrai...... ....... 182
— — Vizcaitarrai................. 185
Choix de proverbes basques.............. 191
Explication de quelques mots rares ou difficiles........................... 203

Bayonne. — Imp. Lamaignère.